***"...gaur goizean Udaltzaingoa agertu da Ibaetako irakasleen etxeak hustutzera. Zortzi familia bizi dira bertan, orain zazpi urtetik. "**
**06/11/30. www.gaztesarea.net**

2005, hauxe hartu genuen lanerako muga.
2006. urtean okupatuz dihardugu oraindik orain.
Hala eta guztiz ere, lan hau osatu gabea da.
Datu zein irudi ugari falta dira, ziur gara.
Zorionez geurean, okupazioaren historia eta istorioak aberatsegiak dira 48 orriotan biltzeko.

Hau jakinik, bere ekarpena egin nahi duteneei deia egiten diegu gurekin parte hartzeko, lan osatuagoa egin ahal izateko.
Auzoz auzoko aurkezpenetan edo ertaia@gaztesarea.net helbidean topo egingo dugu.

**Okupazioa aurrera!**





# aurkibidea

> Hay que presionar al Ayuntamiento sobre una reivindicación justa ya que de esta forma se va abriendo camino para que la conciencia de la ciudad y de los munícipes en particular llegue al grado de que esa necesidad es justa.

**ODON ELORZA.**

Hogei urte baino gehiago igaro dira lehenengo okupazioek, gune kolektibo autogestionatuen aldarrikapena eta etxebizitza eskuragarrien beharra kaleratu zituztenetik.

Inork ez du zalantzan jartzen aipaturiko aldarrikapenen muina inoiz baino gaurkotasun handiagokoa dela. Izan ere, instituzioek eskari sozialari erantzutetik urrun, espekulazioa sustatu dute. Gehiegitxo. Ordainetan eskuraturiko onura urtsuak ikusirik, nola ez zuten egingo ba? Ez dute alderdi politikoen finantziazioa ikertu nahi, inmobiliaria lobbi erraldoiak baitira jaten ematen dieten esku handienak.

Gazteriak bizi duen prekarietate egoera, etxebizitza duin bat eskuratzeko ezintasuna eta ezin emantzipatzea, gazteak instituzioen jendarte ereduari ongi lotzeko kateak dira; elkarkidetza, lan kolektiboa edo auto-kudeaketa bezalako baloreak saihesten dituen ongizate eredua, hain zuzen.

Eurak bai inposaturiko kapitalismo basatiaren etsai amorratuak! Ez dute indarkeria neurrigabeena erabiltzeko zalantza izpirik ere! Eurak bai "bakezaleak"!

Baina desalojo, eraso, zigor eta epaiketez beteriko hogei urte hauetan ezin izan dute okupazioarekin amaitu. Are eta gehiago, etxebizitzaren garestitze ikaragarriaren eta instituzioen gazte alternatiba ezaren aurrean, okupazioa protesta egitea baino gehiago dela ohartu da jendartea. Legez dagokiguna eskuetan hartzea zilegi denaren kontzientzia hedatzen ari da.

Etxebizitza edukitzeko oinarrizko eskubidea jabego pribatuaren eskubideak ordezkatu du. Alboratu. Aldiz, okupazioak, borrokatzen, defendatzen, aldarrikatzen, amesten dugun hori errealitate egiten du. Espekulazioa salatu eta aldi berean hutsik dauden etxe eta lokalak eskaini. Gure arteko harremanak eta denbora gure modura kudeatzen laguntzen digu.

Okupazioa ez da helburua, bai, ordea, borrokarako tresna, sistema juridiko- errepresiboari desobedientzia eta intsumisio jarrera eginez, politikarien negozio espekulatzaile zikina agerian uzten duena.

Urte luze hauetan Gaztetxe eta okupaturiko etxe ugari desagertu dira, baina baita esperientzia berriak sortu ere. Eskaera sozialei kasu egin eta espekulazioa amaitzean, pertsonaia ustelei eta euren matoi harroputzei okupazirako beharrik ez dela egongo gogoratzeko balio duten esperientziak dira. Bien bitartean,

# AURRERA!!!



**Gorka "Moska"**
Donostiako Okupazioaren Aldeko Asanbladako kide ohia

Erreparatu al diezu inoiz gure kaleetako eserleku unipertsonalei? Zertarako jarri dituzte? Agian hitz egin ez dezagun, edo eta elkartu, nahastu ez gaitezen. Egunerokotasunak bizimodua eta baita erlazionatu behar garen modua ere baldintzatzen dizkigu. Urbanismoa ez da aparte doan zerbait. Espekulazioaren atzetik pisu handiko osagai asko dago. Eta Donostian guztiak aurki daitezke. Kapitalaren izenean, nortasun zeinurik gabeko metropoli handi bat eraikitzen ari dira, edo monopoly erraldoia deitu beharko genioke?. Euskal Herria eraiki beharrean Euskal Herrian eraikitzen ari dira. Gure herrian dugun baliabide eskasena agortzekotan da beraien megalomania; lurra, alegia. Izan ere, ez da lurrik ikusten eurak pasatzen diren lekutik. 14 000 etxe huts baino gehiago dituen gure monopoly honetan, egunero altxatzen dira eraikin berriak. Gainera, hutsik dauden 2400 etxebizitzak, señorita eta señoritoek uda pasatzeko bigarren etxeak dira. Bizi garen jendarte merkantilista honetan etxebizitza produktu bilakatu da.




Informazioa propagandak eta elkarrizketa inposaketak ordezkatu dituen egoera batera kondenatu gaituzte egungo gorbatadun apostoluek. Eserleku unipertsonalen ondoan, Garbera, Arco edo Bretxa bezalako makromamutzarrak ikusi ditzakegu; lurrera begira ezin baita luze ibili. Gazteok, eta ez hain gazteek era konbultsiboan kontsumitu dezagun eginak daude merkatal gune erraldoi horiek. Hirigintza, aisialdi guneak, komunikabideak... gazteria sumiso eta konformista duen jendartea mantentzeko, eskura dituen bitarteko guztiak bere mesedetara jarriak ditu sistemak. 1993ko urtarrilean, Gipuzkoako gaztetxeen koordinakundeak, honela definitzen zuen jada gaz-

**Anitza gazteria eta anitza beraz okupazioa Zementuaren jauntxoen sistemaren aurrean hamaika forma hartu dituen mugimendua da okupazioarena**

## EGITARAUA

ASTELEHENA 31:
Musikala filma: «Quadrofenia».

ASTEARTEA 1:
Maia ingurua: «Donostian gaztedierentzat politika munizipala». Udaletxeko erakunde politikoak itzezgingo dute. Modelatzaile: Mariano Ferrer.

ASTEAZKENA 2:
Antimilitarista filma: «Marcha triunfal».

OSTEGUNA 3:
Drogoretaz filma. D.E.E.ko gendea parte artuko dute.

OSTIRALA 4:
8'tan Maia ingurua: «Etxekok Gazteen». Parte artuko dute gazteak: Madrileko, Barcelonako, Bilboko eta Iruñako.

9,30'tan: Trinitateko enparantzan: Rock «jaiaidia» bat egongo da. (Cirrosis, R.I.P., Basura eta Optalidon ekin).

LARUNBATA 5:
«Haurrarentzat jokoak».

Goizeko 10'tan Konstituzioko enparantzan.

6,30'tan Boulevard'ean manifestapena.

IGANDEA 6:
Goizeko 11'tan auzi-lan: Orain taldea.

Eguardiko 12'tan Konstituzionako enparantzan: Artesania, margazkia eta poesiako erakusketa. Txarangak eta antzerkia.

---

Arratsaldeko 8'tan Biblioteka Munizipalean aktibidade guzti hauek izango sarrera.

## Semana Pro-Casa de la Juventud

LUNES 31 DE ENERO (COMENZAMOS):
Película musical: «Quadrofenia».

MARTES 1 DE FEBRERO:
Mesa redonda: «Política municipal para los jóvenes en Donostia». Con la participación de partidos políticos, asociaciones, etc. Moderador: Mariano Ferrer.

MIERCOLES 2 DE FEBRERO:
Película antimilitarista y coloquio: «Marcha triunfal».

JUEVES 3 DE FEBRERO:
Película sobre el tema de la droga.
Con la participación de D.E.E. (Asociación Afectados por la Droga).

VIERNES 4 DE FEBRERO:
8 noche. Mesa redonda: Casa de Juventud. Participarán jóvenes de Madrid, Barcelona, Bilbo e Iruña.

9,30 noche. Festival rock. En la Plaza de la Trinidad: Cirrosis, R.I.P., Basura, Optalidón.

SABADO 5 DE FEBRERO:
Juegos infantiles a las 10 de la mañana en la Plaza de la Constitución.
Manifestación a las 6,30 de la tarde en el Boulevard. «Locales para los jóvenes».

DOMINGO 6 DE FEBRERO:
A las 11 de la mañana, actuará el grupo Orain.
A las 12 del mediodía, en la Plaza de la Constitución, exposición de artesanía, pintura, poesía, teatro, txaranga, etc.

(...y seguiremos más y mejor).

---

Todas las proyecciones y charlas se celebrarán en la Biblioteca Municipal a partir de las 8 de la tarde.

tearen prototipoa: "...Diruak liluraturik, buru belarri aritzen da lehian, lehena izateko, lehiakorrago izateko; berekoikeria sustatzen duen gizarte honek data zehatzak jartzen dizkio elkartasunerako egunei". Hamabi urte geroago, bota kontuak! XXI. mende honetan, sistema inoiz baino indar handiagoz ari da gazteon aisialdi, kultura, eta, finean, bizimoduaren alienazio saiakeran. Bizi eredu berdina artalde guztiarentzat.

1996ean, Egiako Karmengo Ama kalean zegoen gaztetxearen kanporatzearen harira, gazteek plazaratutako idatziak ondo jasotzen zuen: "Historiak esperientzia eman behar lieke, baina esperientzia, burusoil daudenean ematen zaien orrazia da". Lehengo lepotik burua eta oraindik ez dute ikasi. Hainbat elementu gaurkoturik eta beste hainbeste garaturik, baina egoerak errepi

**Donostiaren kasuan Prim kaleko lokalak okupatu ziren 1978an**

katu egiten dira. Gaur egungo gazteon hainbat bizipen 40. hamarkada amaierako gazteek bizitakoak dira. Borrokak ez dira egun batetik bestera irabazi edo desagertzen diren haserre erakustaldiak. Ama lurrak bere defentsan aritzeko premia izaten jarraitzen du, drogaren erabilpen politikoaren aurrean burujabea izango den erabilpena sustatu behar da, jendartearen alienazio prozesuari bizi eredu

aske eta alternatiboak eraiki eta garatzen erantzun behar zaio eta, espekulazioaren aurrean okupazioak aukera bakarra izaten jarraitzen du. Hauxe da eskuetan duzun lanaren helburua; Donostian okupazioaren inguruan bizitakoak, guztiak ez badira ere gehiengoa, biltzea. Izan ere, okupazio mugimendua anitza izan da eta da, gazteria bezala, eta paperean azaltzen ez diren okupazioak egin direla ziur gaude. Ziurrenik guri ere baten bat pasako zitzaigunez, argi dugu lantxo honek osatua izateko beharra duela. Guk testigua pasatzen dugu.

Anitza gazteria, eta anitza, beraz, okupazioa. Zementuaren jauntxoen sistemaren aurrean hamaika forma hartu dituen mugimendua da okupazioarena. Milaka aurpegi dituen gazte mugimenduaren isla, alegia. Bizi eredu askatzaileak eraikitzeko eta garatzeko, bizimodu duin bat aurrera eramateko edo, besterik gabe, protestarako balio izan duen tresna da okupazioa. Gorabeherak medio, gaurdaino indartsu heldu den tresna.

60. hamarkadan Europako hainbat herrialdetan indartsu egin zen mugimendua, hamarkada bat beranduago ezagutu zuen





Euskal Herriak. Oinordekotza ondo loturik utzi arren, Espainiako diktadore txikiaren heriotzak arnasa ekarri zion Euskal Herriko herri mugimendu borrokalariari.

Diktadura guztietan bezala, soilik agintariaren menpeko ziren erakundeak zeuden baimenduak -gaur egun bezalaxe-; Sindikatua, partidu politikoa eta gazte erakundea, OJE ( Organización Juvenil Del Estado), hain zuzen ere. Baina diktadorearen heriotzarekin batera, estatuko ageriko estrukturek gainbehera ezagutu zuten. Eta honela, 1977, 78 eta 79 urteetan hainbat herritan gazteek OJE-ren lokal zaharrak okupatzeari ekin zioten. Modu antolatu gabean, Euskal Herriak hamarnaka okupazio ezagutu zituen.

Donostiaren kasuan Prim kaleko lokalak okupatu ziren 1978an, “Batzuk ezer ere ez egiteko hainbeste azpiegitura eta guk batere ez? Ez dago eskubiderik!” lemapean. Baina okupazioak gutxi iraun zuen. Euskal Herrian ematen ari zen autonomiaren deszentralizazio prozesuan, lokalak EITBk eskuratu zituen. Okupazioari dagokionez geroago gazte antolaketari begira garrantzi berezia izan zuen “Gazteen astea” antolatu zen. Prim kaleko lokal autogestionatuaren alde gazte ugari bildu ziren apirilaren 20, 21, 22 eta 23an.

Dagoeneko gazteen beharra eta aldarria zena plazaratua zegoen eta, eskaerei bide eman asmoz, 1982. urtean “Lokalak gazteontzat” izeneko gestora bat sortu zen. Udaberrian abiatu zuten lehen kanpaina, “Egin zerbait, ez lokartu” lelopean. Gestora sortzearen ideia 82ko Martxoaren 25ean Dipuan egindako asanblada ireki batean jaio zen. 28 gazte elkarte eta 70 gazte inguru biltzen ziren bertan. Udalarekin harremanetan jarri, lokal hutsak identifikatu eta girotze ekimenak antolatzeaz gain, “SATAN” izeneko aldizkaria kaleratu zuen. 1983ko urtarrilaren 31tik otsailaren 6a bitarte “Gazteentzako etxea”ren aldeko astea ospatu zuten. Astean zehar eginiko zine emanaldi, mahainguru, kontzertu (R.I.P, Cirrosis,...) eta manifestazioak arrakasta eduki zuten: egunero, bataz beste, berrehun gazte inguruk hartu zuten parte. Hemen hasten da, ondorengo hamarkadetan Donostia aldetik aldera zeharkatu duen okupazioaren abentura.

## Todos los jóvenes el día 12 de Marzo debemos ocupar «La Voz»

Sí, colegas, son muchas las movidas que hemos hecho hasta ahora, pero tenemos que enrollarnos con posturas mucho más radicales.

**Estamos cansados** no ya de promesas, que ni siquiera nos las dan, sino de esperar en los pasillos de los centros oficiales, burocráticos y fachas. **Estamos cansados de intentar** hablar con el Arístegui, de la cerrazón del PNV, de la suspensión de actos, de las zancadillas de otros y un largo etcétera.

¡Basta ya de rollos malos y actuemos ahora!

Todos sabemos quiénes son los censores que nos quieren colocar esparadrapos en la boca (por no decir en todo el cuerpo) y nos niegan la VOZ.

Tías y tíos martxosos o menos martxosos, personajes jóvenes que tenemos ganas de montárnoslo wai, de intercambiar experiencias, trabajos, relaciones etc.

Exigimos un txoko! AHORA!, un txoko que sea la juventud quien lo lleve adelante, sin dejar que lo hagan ellos.

Por todo esto tenemos que hacer del día 12 un día de encuentro, fiesta, enrolle y reivindicación de algo que es nuestro y para nosotros.

**SIN MANEJOS**, porque queremos hacérnoslo como queramos.

¡Que no nos pidan votos, queremos hechos!

Demostrémosles que nuestra movida es más sana que la suya y que la juventud es capaz de hacer las cosas mejor que ellos.

Si queremos intentar romper con esta mierda de sociedad, empecemos a caminar hacia LA VOZ.

¡Exigimos LA VOZ para los jóvenes!

¡Queremos que SE CREE una política municipal, CONTANDO CON LOS JOVENES!

Enrollaros y no paséis de vosotros, pasad de ellos.

El día 12 nos vemos en la ocupación de LA VOZ, de la calle San Marcial.

**Gestora pro-Casa de la Juventud de Donostia**

80. hamarkada hasieran eta PSOE-ren berregituraketa politikaren ondorioz, gazte asko, ezer egitekorik gabe, kale gorrian geratu ziren. Gazteriarentzako azpiegitura gabeziak ezinegona sorrarazi eta hainbat gazte asanblada edo gazte gestoraren sorrera bultzatu zuen. Instituzioei gazteak bosta axola zitzaizkionaren usteak, beharrezko tresnak eskuratze bidean okupazioa alternatiba bakarra zela erakutsi zuen. Hastapenetan Udalaren jabetza ziren lokalak okupatzea lehentasuna bazen ere, gerora hutsik dagoen edozein eraikin izan da erabilgarri. Gaztetxeak izaera eraldatzaile eta kulturala duten gazte elkarguneak dira, eta nahiz eta guztiek autoantolaketa eta autogestioa oinarri eduki, bakoitza mundu bat dela esan daiteke. Herri edo auzo desberdinetako gazteen behar, borroka eta bizipenen isla.

Okupazio bidez lortuak izan ez diren baina gazteok kudeatzen ditugun guneak ere badaude, gazte lokalak hain zuzen. Honen adibide, Loiola edo Añorgako gazte lokalak dira.
Okupazioa bidea eta gaztetxea tresna. Aisialdi eta kultur ekintza hutsak antolatzeko guneak izatetik haratago, auzo eta herrietan eragin eta gazteon ekarpena ahalbidetuko duten tresnak izan dira gaztetxeek.

### 1983. "La Voz"

Ziurrenik, Euskal Herriko lehen gaztetxe saiakera, 1983ko udaberrian Donostian egindako okupazioa izango da. Gaztetxe hitza oraindik erabiltzen ez zenez, "Donostiako gazteen etxea" izena hartu zuen "Lokalak Gazteontzat!" gestorak eginiko lanak. Fruituak eman zituen eta "SATAN" aldizkariak zabalduriko dei baten bidez, hamarnaka gazteek, San Marcial kaleko "La Voz De España"ren eraikin hutsa okupatu zuten.

Hiru solairuko gazteen etxean 200 gazte inguru biltzen ziren. Lehenengo solairuan rockeroak elkartzen ziren, baita kontzertuak antolatu ere. Bigarrenean, gorputz adierazpenerako tailerrak burutzen ziren, eta hirugarrenean bilkura gelak zeuden.
Baina agintariak ezin atzean geratu, eta okupazioaren lehen egunean Iberduerok eta Telefonica-k argia eta telefonoa moztu zizkieten gazteei. Handik gutxira, Madrildik etorritako jabeak orduko 1 400 000 pezetatan baloratu zituen eraikineko kalteak, gazteek txukundu besterik egin ez zutenean (baina noski, inork ez zion erreparatu). Jabearen bisitatik aurrera, polizia etengabe oldartu zen gazteen etxearen aurka; giro honetan, hainbat kanporatze eta okupatze tartekatu ziren. Apirilean atera-sartzea bi aldiz errepikatu zen. Azkenik, maiatzean, gobernadore zibilaren aginduz Espainiako Poliziak behin betiko kanporatzea egin zuen, eta 27 gazte atxilotu. Gazteen aurkako epaiketa 1984ko urtarrilean izan zen. Donostiako gazte asanblada guztien babesa jaso zuten gazte auzipetuek.





Maderoen kanporatzetik denbora gutxira, maiatzaren 8an, Udal hauteskundeak zirenez, protestek indar berezia hartu zuten; aipagarrienak, 19 gazte taldek antolaturiko bizikleta martxa eta Foru Aldundian akanpada.

### 1984. Bidebieta

Metxa piztuta zegoen eta gazte asanbladak jo ta su zebiltzan auzoetan. Honela, 1984ean Bidebietako "Peña Taurina" ondoan zeuden hainbat lokal okupatu ziren. Bidebietak bazuen gaztetxea! Hala ere, 1983ko okupazioak baino gehiago iraun bazuen ere, 3-4 urteren buruan lokala utzi behar izan zuten.

### 1987. Jareño-Egia.

1987an Donostiako gaztetxea berpiztu egin zen, maiatzean gazte talde batek Egiako Jareño fabrika zaharra okupatu zuenean. Denbora gutxian Donostiako erreferentzia argia bilakatu zen. 3 urtez gitarra eta txalaparta ikastaroak, bideo proiekzioak eta kontzertu sonatuak antolatu zituzten --besteak beste, Kortatu edo Negu Gorriak-.

Baina 1990ean eraikina erosi eta erausteko agindua eman zuen Udalak. Gazteak negoziatzeko prest agertu arren, Udalak, isilka eta elkarrizketen erdian, bortizki desalojatu zuen Jareñoko fabrika zaharra.

### 1987. Amara Zaharra

1987an baita ere, Amara Zaharrean 18 urte iraun dituen lokala okupatu zuten. Hasiera batean gaztetxe bezala funtzionatuko bazuen, kokalekua delaeta, (zakurtegiaren parean) azken urteetan koadrila desberdinen elkargune diskretu bat izaten bukatu zuen.

### 1987. Parte Zaharra-Guardetxea

1987. urtea mugitua izan zen Parte Zaharreko gazteentzat. Hilabete batzuk lehenago auzoan eginiko okupazio sinbolikoek berotua zuten giroa, eta Urgull mendiko zaintzaileak bizilekua utzi bezain laster, gazteek bere egin zuten. Udaran zehar, Guardaetxea gaztetxe bilakatu zen. Baina Jarrai, Kemen eta beste gazte talde batzuetako kideek abiaturiko proiektuak gutxi iraun zuen. Udaran zehar, iheslari politikoen kontrako estradizio masiboak gertatu ziren. Protesta eta istiluak eguneroko bilakatu izanak, gaztetxearenganako kontrol poliziala ugaritu zuen, presentzia itogarria eginez. Nekeak, gazteen arteko gaizki ulertzeak areagotu zituen, eta udara amaitzearekin batera, gaztetxearen bukaera etorri zen.

### 1993. Xolot-Antigua

1993an, Antiguaren txanda heldu zen. Bi hilabete iraun zituen lehen saiakeraren ondoren, "Xolot" gaztetxea okupatu zuten Antiguako
gazteek. "Xolot"ek bi urteko bizia izan zuen, eta nahiz eta gaztetxea bota behar zuen enpresarekin hitz egin, indusmakinek euren lana bete zuten. Antiguokoa ez zen urte hartan desalojatu zuten gaztetxe bakarra izan. Erasoak salatu eta okupazioa defendatzeko, nazio manifestazioa deitu zen Donostian. Milaka gazte bildu zituen protesta, Askatasunaren hiribidera iristean, Espainiako Poliziak bortizki sakabanatu zuen; istiluak tamainakoak izan ziren.

### 1995. Karmengo Ama. Egia

90. hamarkada erdialderako, belaunaldi berriak guztiz murgildu ziren okupazio dinamiketan. Ondorio gisa, 1995eko apirilean Egian bigarren saiakera egin zen Egian. Karmengo Ama kalean gaztetxeak 9 hilabete bizirik iraun ondoren, diru



**1995. Karmengo Ama. Egia**

gosez eraikitako etxebizitzek ordezkatu egin zuten. Honela hasten zen 1996ean, kanporatzearen harira kaleratutako idatzia: “Sistemari ebatsitako lur zati txiki horrek bizirik dirauelako...zeuen-geure ametsak hainbat une goxotan gurekin bizi izan dituzuenei eskerrak eman nahi dizkizuegu”.

### 1996. Letaman. Intxaurrondo

Egiako kanporaketarekin batera, Intxaurrondo Zaharreko ikastola hutsik geratu zen. Aspaldian fabrika eta ondoren ikastola izandakoa, 9 urte bete dituen “Letaman” gaztetxea da egun. Egun 5 musika talderen entsaioleku dena, hamaika talderen joan etorriaren lekuko izan da, baita gizarte eragile askoren elkargune ere, tartean, AHT-aren aurkako asanblada, Gelditu! Prekarietatearen aurkako taldea edo Eten globalizazioaren aurkako taldea. “Intxaurkaria” gazte aldizkariaren sorleku eta “Zurrunbilo” Altzako gazte aldizkariaren bileraleku ere izan da.

Intxaurrondoko gazte asanbladak 2004ean eraberritze lanari ekin zion eta azken bi urte hauetan “Letaman”en ospatu da jai herrikoien aldeko Pirata Gaua, ehunka gazteren parte-hartzearekin.
Urte hauetan zehar poliziaren jazarpen sistematikoa sufritu du Letaman-ek eta 2005eko urtarrilean, gaztetxe aurrean asteak zeramatzan moto baten barruan kamera bat aurkitu zuten auzokideek. Ohartu eta ordubetera txapelgorrriek motoa eraman zuten.

### 1993. Añorgako Gazte Lokala

Nahiz eta Añorgako gazteek 90. hamarkadako lehen erdialdetik kudeatzen duten lokala, azken urte hauetan eman da ezagutzera “Añorgako Gazte



Lokala”. Esan dezakegu 2004ean ia asteburuero musika emanaldiak egin direla. Lokalaren jarduera, belaunaldi berriek indartu duten Añorgako Gazte Asanbladaren esku dago. “Añorga Hilzorian” fanzinearen sorleku ere bada.

### 1995. Altza. Rutilita

1999.urtea, hiru urte iraun zituen borroka baten abiapuntua izan zen. Abenduaren 25ean Altzako gazteek, 15 urte hutsik zeramatzan fabrika okupatu zuten, “Rutilita”. 6 hilabete soilik iraun zituen zutik, zipayoek desalojatu zuten arte. Hala ere, utzi zuen ondarearen adierazgarri, “Zurrunbilo” eta Gazte Asanbladaren artean kaleraturiko musika CD-a; “Ruti Compilation!”.

### 1995. Gros. Iztueta

Grosek ere bizi izan zuen okupazioa. 1999ko ekainean, Donostiako okupazioaren aldeko asanbladako hainbat lagunek Iztueta kalean etxea okupatu zuten. Hasierako ideia bizileku bat eraikitzea baldin bazen ere, bertaratutako gazte piloa ikusirik, etxearen lehenengo solairua gaztetxe gisa zabaltzea adostu zuten. Uztailean okupatutako etxeak udan jaso zituen lehen mehatxuak. Protesten artean “Corazon del Sapo” musikak taldeak etxeko teilatuan kontzertua eskaini zuen. Irailaren 18an, baina, zipayo eta munipek kanporatzeari ekin eta industmakinek etxea bota zuten; hamar gazte inguru atxilotu zituzten. Zinemaldian eta Porrontxo jaietan hainbat mobilizazio burutu ziren.Argi dago ondoan dagoen justizia eraikin berriaren obrek bultzatu zutela ez legezko kanporatzea


1995. Gros. Iztueta

“Iztueta” etxeko esperientziaren ondotik eta mende berriaren atarian, belaunaldi berriak borrokara lotu eta lekukoa bere gain hartu zuten. 2000. urtean Donostian bi gaztetxe okupatu ziren. Ekainean, “Rutilita” gaztetxea bota eta bi egunetara, Altzako gazteek 4 pisu zituen “Etxe urdina” okupatu zuten. Aurreko okupazioak bezala, 6 hilabete iraun zituen esperientziak, baina kanporatzea bitarte eragile askoren elkarleku bihurtu zen. Gazte asanbladaz gain, “Zurrunbilo” gazte aldizkariak eta “Gazte bonobusaren aldeko plataformak” ere bere egin zuten gaztetxearen aldarria. Esan bezala, 6 hilabete pasa ondoren, indusmakinek eraikina txikitu zuten.

### 2001.Antigua

Antiguan ere, urte berean gazteek gaztetxea eskuratu zuten. Seminarioko igoeran zegoen etxeak urte beteko bizia izan zuen, 2001eko abuztuan, ezezagun batzuek su eman eta guztiz kiskalia geratu zen arte. Gertaturikoa salatzeko egindako protestek Donostiako gazte asanbladen eta gazteen arreta erakarri zuten; Antiguako gazte asanblada indarturik atera zen.

### 2002.Loiolako Gazte Lokala

Udal agintari eta zementuaren jauntxoen txikiziorako super gaitasuna zela-eta, bi urte burumakur pasa ondoren, “Loiolako gazte lokala” jaio zen. Aurretik auzoko hainbat eragilek kudeatutakoa,



Auzoko gazteek lokala botatzea ekidin dute.

**Loiolako gazte lokala ez eraistea lortu dute**

2002an Loiolako gazteen esku geratu zen. Bertan, Loiolako Gazte Asanblada eta Korrokoi Aisialdi Taldea sortu eta biltzen ziren. Auzoko jaietako Gazte Egunaren antolaketa ere bertatik bideratzen zen. Bi urtez, musika talde hasi berrien txapelketak, mendi txangoak, bideo emanaldiak... antolatu zituzten. Udaletxeak auzoan etxebizitza berriak eraikitzeko zuen planaren ondorioz, 2004ko uztailean kanporatzeko lehen abisua jaso zuten. Mehatxuaren aurrean antolatuz, lokalean lotan geratzeko erabakia hartu eta Udaleko makinen aurrean plantoa egin zuten. Gazteen jarrerak, indusmakinek atzera egin eta gazte lokala zutik mantentzea lortu zuen. Baina gris koloreko jauntxoen diru goseak behin-betiko kanporatzea ekarri zuen 2004ko irailaren 23an. Goizeko 7:00ak aldera, aurpegia estalita zeramaten udaltzainek lokala hustu eta barrukoa lapurtu ondoren, “Demoliciones Usabiaga” enpresako langileek guztiz txikitu zuten etxea. Orain, soilik aberatsen eskuragarri egongo diren etxebizitzak eraikiko dituzte gazteon ametsen gainean.

### 2002.Altza

2002ko otsailaren 16ean, Altzako hirugarren gaztetxea izango zen lokala okupatu zuten. Gazte Asanbladak urteak hutsik zeramatzan lokala egokitu ondoren, 8 hilabetez erabilpena eman zioten. Lokalaren jabeari, gaztetxearen egoera txukun eta berriaz jabeturik, errekuperatzeko gogoa sartu zitzaion eta behin gazteak salatuta, 2003ko urriaren 29an munipek eta zipayoek desalojatu zuten. Beldurrezko Zinemaldian zehar protestak burutu ziren.

### 2005-Egia. Ametsenea


Ametsenea Okupatzeko unean

Euskal Jaien kanporatzeak Euskal Herri zabalean eta Zuloagako okupazio sinbolikoak Donostian gaztetxeen aldeko dinamika astindu zuten. Honela, 2005eko otsailaren 11an, Egiako Ametzagaina kaleko Aitor Ikastolaren eraikin zaharra okupaztu zen. Auzoko gazteek, bost urte hutsik zeramatzan etxean “Ametsenea” gaztetxea sortu zuten. Etxea egokitu eta asanblada, kontzertu, afari eta emanaldi desberdinen bidez gazte dinamika indartsu baten abiapuntua ezarria zutelarik, hirugarren hilabetearekin batera eraikinaren erausketa agindua iritsi zen. Batzuen etsipenak eta besteen erresistentzia grinak gaztetxearen dinamika eten bazuen ere udako azken egunetan erritmoa berreskuratu zuen. Desalojatzeko asmoen aurkako protestak egiteaz gain, filme emanaldi eta ikastaroak (perkusio, euskal dantzak...) antolatzen jarraitu zuten. Aste Nagusian Piraten elkarleku izan zen eta Porrontxotan berriz jaiaren erdigune.

Ametsen etxearen geroa ordea, aurrez idatziriko kronikaren menpeko zen. Urriaren 14ean hiru eguneko epean gaztetxea hutsarazteko epaileak emaniko agindua jaso zuten. Asteburuan zehar erresistentziarako deia zabaldu eta Urriaren 17an hamarnaka izan ziren goizeko zortzietarako Egiara hurbildu ziren gazteak. Indar erakustaldiak, kanporatze agindua betearazi behar zuen guardia munizipalak atzera egitea eragin zuen. Epaileari kanporatzea egiteko gaitasunik ez zutela adierazi zioten, gazteen artean konfiantza eta itxaropena indartuz. Hurrengo egunetan protestak biderkatu egin ziren. Urriaren 25ean azkenik, zipayoak Ametseneara sartu ziren.

Barruko bunker-ean zeuden gazteak kanporatu eta gaztetxera gerturatutako gazte eta bizilagunak kolpatu eta sakabanatu ondoren, eraikina eraitsi zuten inolako neurririk hartu gabe. Goiz osoan korrikaldiak izan ziren protagonista, baita guardia zibilarekin ere. Hauek auzoko sarrera irteeretan kontrolak jarri zituzten.

Protestak udaletxera heldu ziren eta munipekin izandako istiluetan gazte bat atxilotua izan zen. Desalojoa salatzeko egin ziren ondorengo mobilizazioek amaiera berdintsua izan zuten. Identifikazioak, kargak, barrikadak...Egun higitsu hauen ondorioz bost gazte auzipetu eta epaiketaren zain daude.

Bederatzi hilabetez, donostiar gazte askoren desira eta nahiak bildu ditu Ametseneak. Ekimen ugariren sorleku, berrogei musika talde baino gehiago igaro dira bere oholtzatik. Eta “Polloe bizirik” gazte asanbladako kideen arabera “Amets berri askoren abiapuntu. Ametsak ezin baitira bota”.

az
ba

**2005-Loiola.**

“Ametsenea”ren atzekaldeko aldapa jaitsi eta Donostiak ezagutu duen azken gaztetxearen okupaziora iristen gara. Gazte lokala txikitu eta hainbat saiakeren ondoren, 2005eko maiatzaren 20an gaztetxe bihurtu zuten fabrika zaharra dago. Loiolako gazteek okupatu zuten eraikina. Jaioberria den gaztetxeak ez du oraindik jarduerarik, baina zutik mantentzen da. Gazteek gazte lokalaren hutsunea estali dute.



**O**kupazioa errepresioa salatu, egoera desberdinen aurrean ezadostasuna erakutsi, elkartasuna erakutsi edo gazteon beharrak aldarrikatzeko tresna izan da, da, eta izango da.

1982ko Maiatzaren 26an, "Lokalak guretzat" kanpainaren barruan, 60 gaztek Udaletxearenak ziren lokal batzuk okupatu zituzten hiriko erdialdean. Okupazio sinbolikoaren helburua, Udaletxearen jarrera salatu eta lokalak aldarrikatzea zen, izan ere, alkatearekin biltzeko gazteek eginiko hainbat eskaerei Udalak muzin egin zien. Lokalean biltzen hasi eta gutxira, Munipek lehen desalojoa egiteko aukera izan zuten. Baita egin ere.

1987. urtean zehar,, Donostiako gazteek gaztetxe baten aldeko mugimendu berri bat jarri zuten martxan, "Zirika" mugimendua. Udal hauteskundeak zirela eta, besteren artean etxebizitza eta okupazio eskubidea aldarrikatuko zituen plataforma elektorala sortu zen, nahiz eta azkenean ez aurkeztu. "Fanzirika" izeneko fanzinea kaleratu eta orduko "Txantxangorri (104 FM)" irrati librea bultzatzeaz gain, lokalak exijitzeko okupazioa burutu zuten. Asteburu batez Alde Zaharreko Fermin Kalbeton kalean, "Carlisten etxea" okupatu zuten. Gaur egun haur liburutegia den eraikina.




Madrilgo Vallecas auzoko etxe okupatuaren desalojoa eta "Hala Bedi" irrati librearen itxiera salatzeko, CAM ( Caja de ahorros Municipal) ek San Marcial kaleko 13. portalean zituen lokalak okupatu zituen gazte talde batek 1989an. Eraikinaren kanpoaldean aldarrikapenak margotu eta eskegi zituzten.
2001eko Uztailean, Antiguoko gaztetxearen erreketa salatzeko gazte asanbladak konbokaturiko manifa amaitzean, hutsik zegoen eraikin bat okupazioaren eta gaztetxearen aldeko aldarriez apaindu eta bertatik komunikatu baten irakurketa egin zen.

2004. urtea okupazioak astindu zuen. Iruñeako Euskal Jai gaztetxearen kanporatze agindua jasozenetik desalojora bitarte gazteek erakutsiriko grinak, okupazioaren ametsen kutxa irekitzea lortu zuen. Euskal Herriko gaztetxe ugari borrokara batu eta protestak areagotu egin ziren. Uztailean, eta "Letaman" gaztetxearen zortzigarren urteurrenaren ospakizunetan, Intxaurrondoko zipayetxea zaharraren eraikinera sartu eta okupazioaren aldarriz bete zuten auzoko gazteek.

Euskal Jai gaztetxearen kanporatze biolentoa salatu eta Donostian gaztetxe baten beharra aldarrikatzeko, irailaren 11n, Alde Zaharrean dagoen Zuloaga eskola zaharra okupatu zen. 40 gazte inguru bildu ziren eta asteburua pasa ondoren eraikina husteko asmoaren berri eman zuten. Okupazioaren egunean zehar

antolaturiko ekimenetan 200 pertsonak baino gehiagok parte hartu zuten, baita auzokide askoren babesa jaso ere. Baina urduri zeuden agintariek aginduta, goizaldeko 7:00ak inguru zipayoen begiradapean zeuden polizia Munizipalek bortizki desalojatu zituzten gazteak. Desalojoaren ondorioz, bi gaztek erietxean amaitu zuten gaua. Kanporatzea salatzeko irailaren 12rako deitutako manifestazioaren aurka ere gogor egin zuten zipayoek, eta hamarnaka zauritu eragin. Egun osoan istiluak izan ziren gazteen, eta zipayo zein munipen artean. Gomazko pilotakadek auzoko portal bat baino gehiago txikitu zuten; errepide mozketak egin ziren eta munipen bost kotxe txikituta geratu ziren ere. Astebetera, hilaren 12an debekatu zuten manifestaldia egin zen, baita jendetza bildu ere. Gertakari hau dela eta lau gazte auzipetatuak izan dira. Hauetako hiru usurpazio eta erresistentzia karguez absolbituak izan dira. Gazteek pairaturiko tratu txarren salaketa ere artxibatua izan da. Prozesuaren aurka eta honek eragindako gastu ekonomikoei aurre egiteko antolaturiko ekimenek gazte asanblada ugariren sostengua jaso zuten.

Auzo desberdinetako gazteek, arazoa konpondu eta gazteon beharrei bide eman asmoz, alkatearekin biltzeko eskaerak egin zituzten formalki. Udalak ez zuen erantzun ere egin. Alkatearen jarrera, eta Zuloagako eskolen zein Loiolako gazte lokalaren kanporatzeak salatzeko,





za
zi-
eta
ra.
ere
ek
ko
en

du
ea-
ki.
en
ko
ko,

2005eko Donostia Egunean, 30 gazte inguruk Urbieta kaleko “Bellas Artes” eraikina okupatu zuten. 2 orduz, urteak hutsik zeramatzan eraikineko balkoietara igo eta aldarrikapenak eskegi zituzten bertatik. Haurren danborrada zela-eta, poliziarekin ez zen inolako arazorik egon. Odonek gazteak entzun behar izan zituen!

Azkenik, 2005eko martxoan, eta etxe hutsak okupatzeko Duina gazte koordinadorak eginiko deia indartu asmoz, Groseko Mirakruz kalean etxe bat okupatu zuten sinbolikoki hainbat gazteek. Euskal Herriko Administrazioaren etxebizitza politika salatzearekin batera, Donostian 14.000 etxe huts baino gehiago daudela txarretsi zuten.

Okupazioaren aldeko pankartak jartzen ari zirela, kalekoz jantzitako txapelgorriak azaldu eta, mehatxu artean, gazteak identifikatu zituzten.















**Un grupo de personas ocupó una villa en Donostia**

**DONOSTIA.–** Un grupo de *okupas* se introdujo en la tarde del viernes en una villa abandonada de Donostia, en lo que constituye la segunda ocupación registrada esta semana en la capital guipuzcoana. El hecho se produjo poco antes de que cientos de personas recorrieran las calles de Donostia en una manifestación en favor de las ocupaciones, convocada con el objeto de llamar la atención de los partidos políticos sobre el problema de la vivienda. Agentes de la Ertzaintza se acercaron a la villa y solicitaron la documentación a varias personas, pero no las desalojaron.

Egia esan, zaila egiten da Euskal Herrian Squat mugimendua identifikatzea. Izan ere, Europako herrialdeetan ez bezala, euskal gazteriak gaztetxeak okupatu eta eraiki izan ditu. Okupazioak barnebiltzen dituen bi mugimendu hauen arteko desberdintasunak ia defini ezinezkoak dira kasu askotan. Okupa mugimendua, 60. eta 70. hamarkadetan Erresuma Batuan eta Berlin inguruan sortu zela esan daiteke. Erresuma Batuan "Squatting" izenez zen ezaguna; hortik datoz "Squat" mugimendua. Partaide gehientsuenak gazteak ziren, baita baliabiderik gabeko familiak ere. Garaiko krisi ekonomikoa zela eta, azkar batean hedatu zen Europan zehar, eta Euskal Herrian 80. hamarkada hasieran eman zen ezagutzera. Indarrean zeuden Punk eta "Antitodo" jarreretatik okupa ideologia sortu zen, errebeldea baina helburu jakinak zituena. Hasiera batean mugimenduari proiekzio soziala hartzea kosta bazitzaion ere, denborarekin, egonkortzea lortu zuen. Squater-ak bizileku baten bila dabiltza, teilatu bat lortzeko zailtasunei okupazioaren bidez erantzuna emanez. Gaztetxeak aldiz, elkarleku izatea dute helburu, eta hori litzateke bi mugimenduen arteko ageriko desberdintasun bakarra. Ideologiari dagokionean, nahiz eta beraien artean koordinatu, Squat etxe bakoitzak bere antolaketa era eta proiektua duela esan daiteke. Okupatzaileek, berriz, jendartean indarrean dauden balore kapitalista, kontsumista, patriarkal eta zanpatzaileak gainditu, bizi eredu kolektibo, askatzaile eta iraultzaile bat garatu nahi dute. Horretarako, komunalismorako bizileku diren etxeak, jarduera sozialerako erabilgarri bihurtzen dituzte. Euskal Herrian, bereziki mugimendu autonomoari loturik azaldu izan dira. Filosofia "hippia" gainditu zuen mugimendu honek aipamen berezia merezi du Donostian, okupazioaren sustatzaile nagusi izan baita urte askotan. Ondorengo etxe zerrenda, bizilekua zein jarduera soziala eskaini duten okupazioena da.

1983. urteko lehen saiakeren ondoren, 1984ko lehen egunetan, hogeita bat lagunek Ategorrieta auzoan etxe bat okupatu zuten. "Toki onena" izena hartu zuen etxeak. Okupatzaileen bizileku bihurtzeaz gain, okupazioaren aldarrirako erreferentzi izatera iritsi zen. Baina Intxaurrondo-Ategorrieta sarbidearen lanak zirela-eta, 1987ko urtarrilaren 12an kanporatze agindua jaso zuten, eraikina bota behar zutela-eta. Gazteek okupazioa defendatzeko deia zabaldu zuten, eta urtarrilaren 14an jendetza bildu zen desalojoa zaildu asmoz. Euskal Herrian Txapelgorriek eginiko lehen desalojoa izan zen hau. Bost ordu iraun zituen. Txakurrek erabili zituzten gas negargarrien gainetik, hainbatetan moztu zen barrikadekin alboko errepide nagusia. Hitz egiteko instituzioei eginiko eskaeren ezezkoa jaso zutenean, erresistentziarako erabakia hartu zuten gazteek. Urtarrilaren 14ko arratsaldean kanporatu zituzten

azkenean, eta etxea eraitsi zuten ondoren.
1986ean "Dutxen etxea" okupatu zen lehen aldiz, hau ere Ategorrietan. Gutxi iraun zuen lehen okupazio honek, baina urte bete beranduago, 1987an, eraitsi berri zuten "Toki onena"ko biztanleek berriro okupatu zuten. Ateak beti zabalik zituen bizileku bihurtu zen; gazte askoren elkarleku eta dinamika ugariren sorleku. 1988an desalojatu egin zituzten, hori bai, asko kostata. Polizia munizipalek zailtasunak izan zituzten teilatura igo ziren gazteak bertatik jaisteko.




Kanporatzeari aurre hartuz, "Dutxen etxea" desalojatu baina aste bete lehenago, 88ko martxoaren 3an, "Zapatari" okupatu zen Ibaetan. "Dutxen etxe"ko hainbat biztanleri, dinamikan parte hartu nahi zuten beste gazte talde bat batu zitzaizkien hamazazpi urte hutsik zeramatzan etxea okupatzeko. "Zapatari" Donostiako okupazioaren aldeko asanbladaren jaiotzaren lekuko izan zen eta, urtean pasa ahala, okupazio mugimenduaren erreferentzi eta ikur bihurtu zen. Inguruko ikastetxeetako gaztetxo askori okupazioaren ateak zabaldu zizkion, esaterako. Hamabi urteko bizia izan zuen etxe honetako biztanleek, "Ezztanda" eta "Sybarys" aldizkariak argitaratu, eta garaiko "Txantxangorri(104Fm)" irrati librean saio bat aurrera atera zuten. Bizimodu berri bat eraiki asmoz, autogestioa eta birziklapenaren filosofia oinarri hartuta antolatu ziren kolektiboan. Lanaren autogestio bidean, tailer desberdinak jarri zituzten martxan; oinetakoak egin, bizikletak konpondu, serigrafia, okindegia...

Okupatu zenetik eraitsi zuten arte errepresioaren jomuga izan zen etxea. Okupazioaren lehen asteetan Espainiako Poliziak hiru aldiz asaltatu zuen "Zapatari" eta,12 urtetan, poliziaren hogei "bisitatik" gora izan zituen. Eraso hauei guztiei salaketa modu anitzen bitartez erantzun zitzaien. Errepresioa hamabi urte luzez gainditzea lortu zuten. Xabier Albizturrek ezin izan zuen Zapatari garaitu; ez eta Odonek hasieran ere. Baina eraisketaren mamuak gero eta pisu handiagoa hartu zuen denborarekin. Zapatari zegoen lur sailaren jabe berriarekin elkar ulertzen saiatu arren, ez zen akordiorik erdietsi. Bidaia amaierara iritsi zen. Enpresa eraikitzailearekin, okupen eskakizunak betetzen zituen Abaño-ko etxe baten desalojoa adostu ondoren, 2000. urteko apirilaren 3an induskatze-makinek Zapatari bota zuten. Aipatzekoa da, baita ere, Zapatariren azken urtea, mehatxuak areagotu ziren garaia, hainbat okupazio berriren abiapuntu izan zela. 1999ko ekainean, Udal hauteskundeen testuinguruan eta "Zapatari" eta okupazioaren aldeko mobilizazio batzuen ondoren, okupazio gehiago eman ziren Donostian.

"Zapatari" okupatu zen urte berean, 1988an, hain zuzen ere, Martutenen beste etxe bat okupatu zen. Gaur egun zutik dirauen "Martu etxea", Donostian jarduera eta partehartze handienetakoa izan duen etxe okupatua da. Baina bariante berriaren lanek eragin dituzten lur mugimenduen ondorioz, etxeak ez du etorkizun batere argirik.

Lau urte lehenago, 1984an, gazte-talde batek parrokiaren jabego ziren hainbat lokal okupatu zituzten. Lokala egokitu eta laugarren urtez bizileku zutela, 1988an, Ramon Labaien alkatearen aginduz gazteak kanporatu eta lokalak itxi zituzten.

1990an Alde Zaharreko "Guardaetxea" okupatzeko saiakera egin zuen Squat gazte talde batek. Ez zuten asko iraun. 90eko maiatzean, berriz, beste gazte talde batek Loiolako zahar etxearen eraikina okupatu zuen. "Payasables etxea" izena hartu zuen okupazioak. Zutik iraun zuen denboran jende anitz eta ugari bildu zituen. Bertako bizilagun baten eskutik, azken urtean etxerik gabeko txakurren babesleku ere izan zen, jabeek kale gorrian utzitako txakurrak jasotzen baitzituen. 1995ean eraikina eraitsi zuten.

Hamarkada berriarekin, belaunaldi berriak batu ziren okupazio mugimenduan. 1994ean, hainbat gaztek "Txomin" okupatu zuten, Loiolan. Udaletxearekin zituzten tirabirak gaindituta, egun bizirik dagoen etxea da "Txomin". Izan ere, Aintzineta pasealekuko 4 zenbakian dagoen etxeak, 1998an jaso zuen gobernu batzordeak etxea botatzeko zuen asmoaren berri. Etxea hutsik zegoela uste zuen langile batek eman zien albistea bertakoei, hirigintzako zinegotzi zen Enrique Aranak elkarrizketa ukatu baitzien behin eta berriro. Donostian aski ezaguna egin den etxe okupatua da "Txominenea", eta etxekoek egiten dituzten jardueren artean, aipagarria da, larunbat goizero antolatzen duten Txomineko rastro ezaguna, besteak beste.



Lerro batzuk atzera aipatu bezala, "Zapatari" botatzear zeudela eta, 1999ko ekainean ospatu ziren Udal hauteskundeetan, okupazioaren aldarria presente egon zen. Ekainaren 10ean Martutenen etxe bat okupatu zen. Okupazioa diskretuki egin zenez, ez zen inolako arazorik egon. Hurrengo egunean, ekainaren 11an, beste hamar lagunek Groseko Iztueta kalean beste etxe bat okupatu zuten, aukera ugari eskaintzen zituen etxea gainera. Egunean bertan, arratsaldeko 19:00etarako okupazioaren aldeko eta etxebizitzaren arazoa salatzeko manifestazioa deitu zen. Manifa okupatu berri zen etxerako bidean zela, kanpoaldea txapelgorriz inguratuta zegoenaren abisua zabaldu zuten etxe barrutik. Manifa bertara iristean, 50 lagun etxe barrura sartu ziren, gainontzekoak ondoko kaleak okupatzen zituzten bitartean. Musika eta danbor joleen artean eta agindurik ezean, zipayoek ospa egin zuten bertatik.

Argi dago okupazio gehienak beharrak eragindakoak izan direla. Sistematik gaindi, gazteok elkargune bat edukitzearen beharrak bultzaturik bakarrik ez, ezintasun ekonomikoak direla-eta bizileku duin bat eskuratzeko okupatu behar izan dutenak asko dira. Etxebizitza eskubide izatetik produktu izatera igaro zen aspaldi eta okupazioa, askotan, horren ondorio da. Zenbatu eta zerrendatu ezina litzateke bizitzeko okupaturiko etxebizitzen kopurua. Gaur egun Donostian 300 lagunetik gora etxebizitza okupatuetan bizi dira. Ondorengo aipamenak gutxi batzuk besterik ez dira, agian sonatuenak eta bat baino gehiago Squat mugimenduaren barruan kokatu beharrekoa, baina okupazioaren erabilpena gehienbat bizilekuarena izan denez atal honen barnean sartu ditugu kasuak.

Oihartzuna izan zuten lehen okupazioak 1987koak dira. Ategorrietan "Iturritxo" izeneko etxea, Bidebietan "Militarren etxeak" eta Trintxerpen hainbat etxebizitza okupatu ziren orduan. Gaur egun denek jarraitzen dute bizileku izaten.90.hamarkadan zehar, asko izan ziren Antiguako "Suchard" fabrika zaharraren eraikinean bizilekua aurkitu zutenak.1992.urtean, hiriko abiadura atzean utzirik eta ingurumenari loturiko bizimodua garatu asmoz, gazte talde batek "Egiluze" baserria okupatu zuen Igeldon. Autogestioan oinarritutako okupazio hau egun ere mantentzen da. Egoera berean dira 1993an Morlans-eko auzoan okupaturiko etxebizitzak.

Benetan sonatua, 1994. urtean, Donostiako familia batek eginiko okupazioa izan zen. Amara Berriko pisu batean lau urtez ezinean bizi ondoren, senarrak lan egiten zuen Egiako eskolaren ondoan etxebizitzak hutsik zeudela ohartu ziren. Garai batean irakasleen bizileku izandakoa okupatu eta hilabeteetan zehar egokitze lanetan jardun ziren. Udaletxearekin harremanetan jartzen saiatu arren, erantzunaren zain daude oraindino.

1998. urtean hainbat okupazio izan ziren Ibaetan, eta 1999an "Iztueta"ko okupazioarekin batera beste hainbat ere izan ziren. Ekainaren 10ean, Martutenen "Bittori" okupatu zen, egun mantentzen dena. "Iztueta" eraitsi ondoren Errekaldeko auzoan beste bi etxe okupatu ziren.

Urte bete geroago, 2000. urtean, Intxaurrondon "San Luis"-eko etxeak eta Loiolan "Zarran" etxea okupatu ziren.

2004.urtean, berriz donostiarren arreta erakartzea lortu zuen okupazioa egin zuen etxegabeko lagun talde batek. Otsailean, Loiola auzoko "Amerikano" etxea okupatu zuten hamabost pertsonek, bizileku baten beharrari aurre egiteko. Uztailaren 16an, eta Loiolako gazte lokalak bezala, erausketa agindua jaso zuten. Egun berean, Udaleko Hirigintza Saileko arduradun Jorge Letamendiak, bost eguneko epea eskaini zien okupei etxea beren kabuz husteko. Zipayo eta munipek kanporatu ondoren bigarrenez okupatu zuten etxea, Udaletxean eta Donostiako Auzitegian bana jartzearekin batera. Etxea uztearen trukean, Udalari errenta baxuko etxebizitza exijitu zioten okupek. Behin gazte lokala desalojatu eta eraitsirik, irailaren 23ko goizaldean, oso garbia izan ez zen okupazioarekin bukatu zuen Udalak. Udaltzaingoak okupak kanporatu eta induskagailuak lanean hasi ziren jarraian.

Gaztetxe edo denadelako mugimenduren baten barruan ezin sar daitezkeen okupazioak ere egon dira; auzo edo herriek, beren beharrei irtenbidea emateko edo musika talde gazteek egindakoak, adibidez. Alokairu garestiak eta eskaintza eza zela-eta, proiektu zehatzak garatzeko ere, okupazioa bitarteko izan da. Bi istorio datorzkigu burura:




1986ean Pasaiako bidean dagoen "Buenawista" eraikina okupatu zen. Buenavista auzoko antzerki taldearen entsaioleku gabeziak eman zion etxeari lehen erabilpena. Bost urte igarota, -1991ean-, edozein erabilpen zapuztu asmoz, Udal langileek eraikinaren barrualdea txikitu zuten. 1994. Urtean, berriz, Udal agintarien nahiari muzin eginez, gazte talde batek, berreraikitze, osatze eta egokitze lanei ekin zien. Lanak amaituta, musika taldeen entsaioleku bihurtu zen eraikina, eta etxeko partaideak "Musika elkarte" aldarrikatu ziren. Bederatzi urtez komunitatean eta asanblean antolatuz jardun eta Donostialdeko musika talde esanguratsuenen sorleku izan zen egitasmoa. Besteak beste, Ezin Izan, Señor No, Jauko Barik, edo Nuevo Catecismo Catoliko taldeak "Buenawista"ko partaide direla esan liteke. Etxebizitza berriak eraiki ahal izateko, Udalak inguruko hainbat eraikin botatzeko agindua eman zuen 2003. urte bukaeran eta 2004. urtearen hasieran. Ondoko etxeak eraitsi dituzten arren, "Buenawista"k zutik dirau, baina dagoeneko ez da kitar hotsarik entzuten bertatik igarotzean. Musika taldeek, entsaiatzen jarraitzeko beste lokalen bat aurkitu behar izan dute beren kabuz. Musika elkartearen jardueraren baitan ere, berrargitaratzea lortu berri den "Destruye" bezalako fanzineak sortu ziren garai hartan.

2003.urtean, Donostiako musika talde hasiberrien topagune izatea helburu zuen "Underground Network" elkartea sortu zuten hainbat gaztek. Beste urrats bat emanez, 2004ko udan zehar, Errotaburuko gasolindegia baino pixka bat aurrerago zegoen lokala okupatu zuten, Infernu auzoan .Abuztuaren 21ean irekiera jaia ospatu zuten. Aspaldi utzia zegoen lokalaren jabeak ezadostasuna erakutsi arren, lokalaren egokitze lanei ekin eta emanaldiak antolatzen hasi ziren gazteak. Jaialdietan garaiko talde donostiar berri ugarik parte hartu zuten, Valium Generation, Sophusyne, Sutura...Elkarteko kideek esan bezala, "...talde hasi berriekin edo inolako disketxeren babesik ez dutenekin lan egin nahi dugu". Urte erdiko ibilbidea egitera iritsi ez zen okupazioan, kontzertuez gain, beste erabateko ekintzak ere burutu zituzten. Arte martzialen tailerra antolatu eta ileapaindegi ikastaroak martxan jarri zituzten. Munipek gazteak desalojatu egin zituzten azkenean, baina honelako gazte elkarguneen beharra agerian uztea lortu zuen ekimenak; baita ateak zabaltzen hastea ere, okupazioko partaide baten hitzak adierazi bezala: "Lokal honetatik botatzen bagaituzte, beste batera joango gara. Ez dugu egitasmo hau baztertzeko asmorik"



**B**atzuk ongi, besteak gaizki eta batenbat oso gaizki. Zementuzko hiri politika duen Donostian egindako hiru okupaziotatik bat ondo atera izana sinestezina litzateke, baina hala da. Beraien hiri eredua zikinduko duelakoan eta diru goseak bultzaturik, Udal agintariek zapuztu dituzten okupazio saiakeren zerrenda osatu ezina da. Honi pertsonen arteko ezadostasunen ondorioz atzean utziriko egitasmoak batuz gero, are zailagoa litzateke. Jarraian aurkezten dizkizugunak frustrazio askoren ispilu mugatuak besterik ez dira:

1983. urtean, okupazio mugimendua bere hastapenetan zen Euskal Herrian. Jaio berri zen olatua hartu asmoz, Squat talde batek Mirakontxan etxe bat okupatu zuen. Okupatu bezain laster eta tokia zela-eta, prentsak “Aristokrakers” izena jarri zien okupatzaileei. Aste betera kanporatu zituzten.

1986ean, Ategorrietan, “Dutxen etxea” okupatzeko lehen saiakera egin zen eta, urte bete geroago, 1987an, Amara Zaharreko San Roken bizilekua eskuratzeko bi saio egin ziren. Udazkenean eginiko bi okupazioak munipek zapuztu zituzten.

Emakume talde batek, emakumeek egina eta emakumeentzako egina izango zen etxea okupatu zuen 1988. urtean. Infernuan zegoen okupazioaren izaerak eztabaidak piztu zituen okupazio mugimenduko kideen artean eta bestelako hainbat eragozpenek emakumeen topaleku izatea helburu zuen proiektua ez garatzea eragin zuen. Amore eman gabe, lehenengo saiakerari jarraiki, Orereta “Matxarda” okupatu zuten, baita helburuak bete ere.

Egiako Jareño gaztetxea 1990ean bota zuten. Donostiako erreferentzi zen gaztetxearen des-



alojoaren aurka mobilizazio ugari antolatu ziren eta, horietako batean, txikitze lanak hasiberri zituen gaztetxea berriro okupatzen saiatu zen. Asmoa gauzatzea ezinezkoa izan zen eta munipek zein Espainiako Poliziak gogor jardun zuten, gas negargarri eta guzti, gazteen aurka.

1993an, gazte talde batek saiakerak egin zituen Donostian bizileku bat okupatu asmoz. Ezintasunak gailendurik Ereñozun eskuratu zuten etxea.

Donostian gaztetxe bat egotearen beharrak bultzaturik, 1995ean ere Alde Zaharreko gazteek elizaren jabego zen etxe bat okupatu zuten Urgull mendiko igoeran. Bi aste igarota, okupaturiko etxea adreiluz tapiaturik esnatu zen, eta saiakera bertan behera geratu.

1999ko irailean zehar hainbat okupazio saiakera egin ziren Donostian, “Iztueta”ko kanporatzearen harira. Etengabe udaltzaingoarekin istiluak sortzen ziren bitartean, Iztuetako kanporaketa eman zen eguneko arratsaldean bertan, Alde Zaharrean bi etxe okupatzeko



ahalegina egin zen, baina saiakera ez zen ondo atera. Giroa aprobetxatuz, Egiako Tabacalera inguruan hainbat gazte etxe batean sartu ziren ere, baina poliziaren gehiegizko presentziak okupazioa ekidin zuen.2001. urtean Egiako Andra Mari kalean beste saiakera bat izan zen. Gazte Asanbladako kideak helburutzat zuten lokalera sartzear zeudela, Munipak etorri eta galarazi egin zieten. Urte bereko maiatzaren 21ean, Altzako gazte asanbladak 10 urte hutsik zeramatzan topo zaharraren egoitza okupatu zuten. Gaztetxea lortzeko borroka bizia zeramaten gazteek, eta Euskotren-ena zen zabortegi bilakatutako lokala garbitu zuten. Okupazioaren bosgarren egunean kanporatuak izan ziren. Ekainean ospatzen dituzten auzoko jaietan Euskotren-en aurkako protestak egin ziren. 2003an, Urrian eta Irailean, Añorgako Errekalden eta Elor-en bi etxe okupazteko saiakera egin zen. Irailean, bost gaztek Añorga eta Usurbil artean dagoen Aritzetan bizilekua izango zen etxea okupatu zuten. Bertan astebete zeramatela eta txapelgorriak bertaratu ondoren, bi gazte epaitegira deklaratzera deituak izan ziren. Egun, 1800 euroko isunari aurre egin behar diote bi aste iraun zituen okupazioagatik. Azkenik 2005eko urtarrilaren hamarrean, Loiolako gazte asanbladak gazte lokala ordezkatuko zuen etxea okupatu zuen. Zipayoen lehen “asaltoa” gainditzea lortu bazuten ere, lau egun geroago etxea tapiaturik aurkitu zuten, jabearen salaketa mehatxua airean zegoela.



Berriro diogu lan hau osatu gabea dela. Agerikoa da Donostian okupazio gehiago egin direla, eta zer esanik ez saiakerei buruz. Eskuan duzunak, etorkizunean behin betikoa izango den zerrendaketaren urrats txikia izatea du helburu. Lekukoa hartzeko prest dago.

Donostian lehen okupazioak eman zirenetik, hauek garatzeko oztopo izan da jauntxoen hiri eredua. Okupazio mugimendua ekidin asmoz, garai desberdinetako alkateek eskura zituzten bitarteko guztiak erabili dituzte. Zementu eta porlanean oinarritutako Hirigintza Plan Orokorra gauzatze bidean oztopo izan edo "Marko inkonparablea" zikindu zezakeen edozer, mapetatik ezabatzen adituak bilakatu dira boteredunak.



Gaur egungo gazte donostiarron kezkak, 90. hamarkadako gazteen kezka berberak dira, eta hauek ere 80. hamarkadako gazteen kezkek aztoratzen zituzten. 1987ko urtarrilean "Toki onena"ren kanporatze agindua salatzeko gazteek kaleratutako agirian ondorengo galderak luzatzen zituzten: "Norentzat da Donostia? Nork ordaindu ditzake bizitzeko teilatupe batengatik honelako salneurri altuak? Nora joan behar dugu bizitzera gazte eta langileok?". 1998. urtean "Txomin"en aurkako mehatxua zela eta zera adierazi zuten: "Argi dago Udaletxeak dirudunen interesen alde lan egiten jarraitzen duela. Donostia bilakatu nahi duten hiri elitistan gazteriaren gehiengoak ez dugu tokirik izango". Eta 2004ean "Zuloaga" okupatu zuten gazteen garrasia izan zena: "Kultur etxerik ez, kiroldegirik ezta ere,...zer eskaintzen digu auzoak? Kontsumismoa eta indibidualismoa bultzatzen dituzten tabernak eta Bretxa bezalako makrokakaplastak!".

Arazoa ez da gaurkoa, eta horrek agerian uzten du Donostiak ezagutu dituen alkate eta indar politiko desberdinen azpitik pisuzko interesek agindu dutela. Bizi eredu oso zehatz bat ezartzen duen sistema kapitalista, Donostiako Hirigintza Plan Orokorraren jabe egin zen aspaldi eta berau oinarri hartuta berreraiki eta berrantolatzen ari dira hiria. Ondorioak inoiz baino ageriagoak dira.

Hirian hirugarren sektorea nagusitzen ari da eta dagoeneko Donostia kontsumo eta aisialdirako gune eta zerbitzuen hornitzaile bihurtu da. Zerbitzuek sortutako lan baldintza onartezinen ondorio, langile gaztea hiri inguruko guneetan bizitzera kondenatua dago. Negozio eta turismorantz bideratua duten hiriko erdigunea herritarrez husten eta bulego, pentsio eta hotelez betetzen ari da bitartean. Marka guztiak gaindituz eraikitzen dituzten auzoek kale eta plazetan gauzatzen den hiriaren




esentzia hil dute. Espazioaren antolaketa monofuntzionala da; norbera bere etxean egon eta lotarako soilik balio duten auzoak, gehienetan pribatuak diren aisialdirako gune bakar eta zehatzak, etxetik ateraldi bakarra eginez hilabeteko "beharrak" asetzera bideratutako makromerkataritza guneak, eta noski, guztiak komunikatuko dituen errepide sarea. Aurrerakuntzarekin nahasten duten zementuaren, porlanaren eta diruaren izenean bizitzeko eredua ezarri digute, eta genuena aldarazi digute. Herritarron arteko hartueman, elkartruke eta komunikazioaren gainetik biztanle automata, motorizatu eta indibidualista sustatu dute, pertsonen beharrak artifizialki sortu eta zeintzuk izan behar duten esaten digutelarik. Zer jan, parranda noiz eta non egin,... baita protesta nola egin behar dugun ere.

Hala eta guztiz ere, gure aurrekari diren belaunaldiei eskerrak eman beharrean gaude. Izan ere, egindako borrokak esnaturiko kontzientziak kapitalismoaren zapalgailua oztopatu eta hartzera zihoan abiadura geldotzea lortu du. Borrokarik ezean, nolakoa genuke gaur gure herria? Yankiena eta gure bizi eredua parekoa litzateke. Zoritxarrez, marraztu nahi diguten etorkizuna bide horretan doa, hamar urteko atzeraldiarekin, baina bide berean.




Sistemak eskaintzen duen bizimodu eroso baina aldi berean faltsura jarraitzaileak erakartzeko bitarteko gehien sortu dituen garaian bizi gara. Sarreran esan bezala, propagandak informazioa ordezkatu duen garaia da gurea.
Txanponak, ordea, badu bigarren aurpegia. Ikusiak ikusita, argi dugu berezko nortasun eta kontzientzia duen herrian bizi garela, eta herria, mundua beste inork ez bezala ulertzeko gai garen herritarrez osatzen dela. Badira diru gosez, mundua ulertzeko berezko gaitasunaz jabetu ez diren herritarrak, bizitza erosoa mantentzearren urkoaren gaitzez baliatzeko prest daudenak:

Baina sekula gure basoak, ibaiak, elkarren arteko harremanak, ama-






ren etxea, nortasuna... Sekula salgai ez jartzeko hautua egina dugunok ere bagaude.Eta gaur egun ere hamaika dira sistemari aurre eginez martxan dauden herri dinamikak: Errauskailuen aurkakoa, jai herrikoiagoak aldarrikatzen dituena, AHT-a ez egitea exijitzen duena, prekarietatea gelditu eta lan istripuak gerta ez daitezen neurriak hartzearen aldekoa... Eta nola ez gaztetxeen eta okupazio mugimenduarena.

Saldu nahi ziguten XXI. mendearen hasieran borrokak itzalia zirudien arren, azken bi urteotan susperraldia bizi izan du. Iruñeako “Euskal Jai” gaztetxearen desalojo bortitzak eta gazteek erakutsiriko erresistentzia jarrerak, eroso zeudenak ere astindu zituen. Giltzapean edo hor nonbait izkutuan genuen ametsen kutxa zabaltzearekin batera, Euskal Herria hamarna okupazioren lekuko izaten ari da. Donostian, bortizki desalojatua izan zen “Zuloaga”ko okupazio sinbolikoa burutu genuen eta nahikoa ez genuelakoan edo, hilabetera lehenengo erasoa gainditurik zuen “Loiolako gazte lokala” erautsi zuten bigarren saiakeran. Gertakari hauen inguruan, helburu argia duen dinamika sortzen joan da, gazteon beharrei buruz hitz egin eta adostasunetara iristeko alkatearekin bildu eta egun bizirik dauden gazte gune aske eta autogestionatuen jarduera errespeta dezaten exijitzen duen dinamika, alegia.

Aldaketa nabari bat eman da 80. hamarkadarekin alderatuta. Garai hartan ez bezala, gaur egun Udal agintariek, Donostiako gazteon beharrak asetzeko bitarteko eta eskaintza desberdinak garatu dituzte, Gazte leku, Kraj!, Gazteszena,...Udalaren gune hauetan ekimen interesgarriak ikus ditzakegu, baina arazoa estaltzeko eta aurpegia zuritzeko sortuak besterik ez direla uste dugu. Guneen kudea-







keta ez dago gazteon esku, gazte sorkuntza sustatuko duten ekimenen eskaintza urria eta partehartze eskasa, ikuskizunetarako sarrera ordaindu beharra, guneen erabilpenerako beharrezko izen ematea eta jarraipen zorrotza, kultur eskaintza mugatua,...

Guk aldarrikatzen dugunaren aurkakoa hain zuzen ere. Gazteok ez dugu Udaleko apostoluek izendatutako ordezkari politikoen kontrolik behar, ezta nahi ere. "Matxarda" etxe okupatuko emakumeen gisa, gazteok geuk eta geuretzako eginak izango diren guneak behar ditugu. Ozen entzun da eskaria azken hilabeteotan, "Bellas artes" eta Groseko okupazio sinbolikoetan, okupazioaren aurkako auzia zela-eta epaitegi pareko protestetan, okupatu berri den "Ametsenea" gaztetxean, desalojoak salatzeko egindako manifestazioetan,...Ez gara bi, ez gara hamar, ehunka gazte gara aldarriarekin bat egiten dugunak. 1983. urtean Donostiako lehen gaztetxe saiakeran ehunka gazte bildu zituen eskaera berberak. Martxoaren 12an "La voz de España" okupatzeko zabalduriko deialdiak honela zihoen: "Bai, lagunak, asko dira orainartean egindako mobidak, baina jarrera erradikalagoak hartzeko urratsa eman behar dugu. Nekatu gara ez soilik eman ere ez dizkiguten agindu eta hitzemateez, baizik eta egoitza ofizial, fatxa eta burokratikoetako itxarongeletan egoteaz... Txoko bat exijitzen dugu! Orain! Beraiei egiten utzi gabe, gazteriak kudeatuko duen txoko bat. Eskusartzerik gabe, nahi dugun bezala egin nahi dugulako...Gure mobida beraiena baino sanoagoa dela frogatu diezaiegun eta gazteriak, gauzak egiten beraiek baino gaitasun gehiago duela..."

Gaztetxeetan garatzen diren harreman, jarduera eta proiektuek gazteriaren alienazio saiakera ezeztatzen dute. Bizi eredu alternatibo eta berriak eraikitze bidean, artaldean ardi beltz kopurua biderkatzeko gai gara. Okupazioak sistemaren aberatsbide nagusi den espekulazioa ekiditen du, eta boteredunen zorigaiztorako, Amara Berri, Añorga, Alde




Zaharra, Gros, Intxaurrondo, Egia, Loiola eta Altzako gazte asanbladak gogotsu daude borrokan jarraitzeko. Okupazioaz gain, txikizioa eta indibidualismoa oinarri dituen hiri ereduaren eraikuntzari mugak ezarri nahi dizkiote gazteek. Herri eta auzogintza bultzatu, "Eurohiriaren" zabalkundearen aurrean. Autogestioaren bidez, gazteon beharrak asetu asmoz, jo ta fuego ari dira zortzi gazte asanblada, eta Donostian zehar hainbat dinamika interesgarri abian jarri dituzte.

Borroka zaharra garai berrietara egokitu, belaunaldi berrien formakuntzan sakondu eta elkarlana ahalbideratze bidean, lanean dihardu gazteriak. 2005eko urtarrilaren 8an gazte asanbladen topaketa izan

zen Añorgan. Lasarteko Txorimalo kolektiboa, Andoaingo gaztetxea eta Añorgako gazte asanbladaren eskutik, muralgintza, kontzertuak eta eztabaidak antolatu ziren, Donostiako hainbat gazte asanbladetako kideak ere bertaratu ziren. 2005eko apirilaren 29, 30 eta maiatzaren 1 eta 2an , okupazioaren I.kongresua egin zen Bilboko "Kukutza" gaztetxean. Okupazio mugimenduaren loraldiaz jabeturik, Euskal Herriko gazte asanblada eta gaztetxeen koordinadora sortu berri da. Aurretiazko bilera batzuen ondoren, lehen baterajotzea izan den ekimena antolatu du koordinadorak, Kongresua alegia. Inoiz baino gaztetxe gehiago dauden momentu honetan, formatzearen beharra ageriago geratu da: okupazio berriak estrategia berriak. Jardunaldi, eztabaida eta tailerretan 700 lagun inguruk parte hartu zuten, tartean Barna, Madrid, Berlin edo Hamburgoko zenbait okupek.Antolakuntzak batu egiten gaitu, eta batzeak, indartu. Gazteria bizi dabil eta kalea kolorea berreskuratzen hasia da. Borrokan segitzeko prestutasuna baina, ez dugu gazteon mesederako soilik diren dinamiketan erakutsi nahi. Aurreko belaunaldiei jarraiki, gure borrokaren bitartez euroa eta zementuaren jazarpena geldiarazi eta eraikitzen ari garen herriari gure ekarpena egiten diogu. Izan ere, okupazio mugimendua, Donostiatik Euskal Herria eta Euskal Herritik Mundua aldatu nahian dabilen mugimendu zabalago baten parte da. Gaztetxe eta gazte lokal autogestionatuetatik beste Donostia bat posible dela ozen diogu, eta hauxe dugu



EZ ITXI! EZ ETSI! EUTSI ETA HAUTSI!

# ERABILITAKO BIOGRAFIA

## LIBURUAK

**Vivienda: Especulación & okupazioak.**
Donostialdeko okupazio batzarra.
Likiniano elkartea.
Lehen edizioa: 2001eko ekaina.

**Gazte matxinada. Inoiz kontatu gabeko historia**
Garikoitza Mujika, Xirika (gazteon kazeta)
2004ko Azaroa

**Egia, gure auzoa**
Josean Jauregi (zai-zoi koordinadora kulturala)
2002ko Irailaren 18a.

## ALDIZKARIAK

**Satan (1983)**
Ostiela (2002ko Udazkena/Negua)
"Ale gaixtoa"
**Zurrunbilo "Altzako gazteon aldizkaria"**
2002ko Maiatza 2. alea
2002ko Uda 3.alea
**Añorga hilzorian (Añorgako gazte lokala)**
2004ko Iraila 4.alea

Eskuorri eta komunikatuak konta ezinak.

## Prentsa

Egin
Irutxulo
Gara
Berria
Xirika gazte kazeta
Irutxuloko hitza

**ETXEBIZITZAREN ARAZOAN**
**UDALETXEAK DITUEN ERANTZUKIZUNETAZ**

1977an OJE-ren Prim-eko lokala okupazio.
GAZTEOK! Gazteriaren artea.

Jakina da hiritar bakoitzaren etxebizitza arazoaz udaletxea ezin dela arduratu, hortarako ez baitu gogorik ez eta gaitasunik ere. Hola izanik ere, gure etxebizitza bakarretik kaleratuak izan garen 10 bizilagunok, besterik ezean, udalaren jabegoko baserri batera jo dugu, udaletxea gure egoeraz oharturik partikularrak baino ulerkorragoa izango zelakoan. Oker genbiltzala esan behar dugu orain: elkarrizketaren bidez gure etxebizitza ezari irtenbide egoki bat ematea ezinezkoa da, baliatuko genukeen baserriak huts eta gero eta eroriago jarraitzen duen artean.
Baserri hau merendero eta atseden leku batean bihurtzeko Alkatetzak eskatutako baldintzak betetzearren, Udal erregistroan aurkeztu genuen proiektuak, gure asmoa zehatz mehatz azalduz, erantzunik gabe gelditu da. Udaletxeak "Cumbre" etxeaz epe jakin batean erabaki bat hartu dezan eta etxebizitzarik gabe gaudenez, hemen sartu eta gose greban hasi gara.

OSASUNA ETA ONGITASUN SOZIALA

Martxoaren 1a geroztik Uliako Auzo Elkartean gose greban gaudenok.

**Fleury-n 2005eko uztailaren 30ean**
**Aupa Gazteak!!**

2005ean Ametseneako kideei, auzoko preso politiko batek zuzenduriko eskutitza.

Zer moduz? Hona hemen besarkadarik beroena oraindik eta beti gaztea izango den egiatar honen partez!

Poz haundiz hartu nuen zuen berri, Ametsenea-ren berri eta berri horrekin batera, okupazioa, garbiketa, << bizilagunen>> ezagutzea, inaugurazioa... beste garai bateko Gazte Asanbladak etorri zaizkit burura, laurogeigarren hamarkadaren erdialdean Plaza Berrin egiten genituen asanbladak, Jareñoren okupazioa, garbiketa, kontzertuak...

Eta bai, ni Gazte Asanbladan hasi nintzenean biltzeko tokirik ez genuenez Plaza Berrin biltzen ginen, bertako banku baten inguruan andana bat izan gabe, taldetxo bat osatzen genuen. Negua eta euria etortzearekin batera eta horiek ezer egiteko baldintzak ez zirelakoan, Arrano Elkartean bildu ginen noiz edo noiz. Bilkurak egitearen ondorioz, auzoko kaleetan Gazte Asanbladaren berri ematen zuten kartelak agertzen hasi ziren << Gaztetxea orain! >> << Auzo bat Gaztetxe bat! >> ..., denak eskuz eta errotuladorez portzierto! Lehenengo helburuetako bat auzotarrei Gaztetxearen beharraren berri ematea zen eta horretarako propaganda ekimenak burutu genituen: kartelak, triki poteoak, mahaiak informazioa banatzen....

Paraleloki udaletxearekin harremanetan geunden eta tarteka bilkurak burutu ere nahiz eta ez ziren oso emankorrak. Ildo horren osagarri okupazioa izanik azkenean gure lehenengo okupazio ekintza burutzera abiatu ginen. Lehenik auzoan zehar zeuden udaletxeko lokal hutsen informazioa biltzen saiatu ginen. Eta Jareño hortxe zegoen bai! Haundia eta gure zai dirudienez! Baina ez! Lehenago zerbait txikixeagorekin hastea erabaki genuen, Jareñon asko garbitzeko egongo zelakoan. Larunbata zen, eta Donostia mailako deialdia egin genuen. Auzo bakoitzean gazte asanbladak martxan zeuden eta nahiko jende zebilen horien inguruan. Donostia mailako deialdia egin eta auzotik manifa bat egin genuen, nahiko jenderekin gainera! Plaza Berritik abiatu, Atotxaraino jeitsi eta gero buelta gora Egia kaletik, Ametzagaina kalean gora, 37 zenbakiaren ingurura iritsi ginen arte, ez dut zehazki gogoratzen. Hor zegoen gure helburua: lokal txiki bat, atea adreiluz itxia zuena. Leiho antzeko bat estaltzen zituen adreiluak puskatu genituen mailu haundi batekin eta irekitzea lortu genuen! Bagenuen Gaztetxea! Denak pozik, manifaren babesean, pozik eta harro! Donostiako lehenengo edo lehenengoetariko Gaztetxea genuen, Egiakoa! Hor geundela oraindik, bapatean gizon bat etorri zen, oihuka, zertan ari ginen gaizki esaka, ea erotu ginen garrasika... Ez zuen ezer ulertzen, ezta guk ere ez. Eta bai! Lokala udaletxearena izatetik urrun zegoen, berea zen! Lokaletik atera, eta minutu gutxi batzuz << Egiako Gaztetxea >> izan zen hartatik burua makurturik atera ginen. Baina gu beti aurrera eta manifarekin aurrera egin genuen!

Denbora pasa eta azkenean Jareño okupatzea erabaki

genuen, baina oraingoan isilpean egin genuela uste det, manifarik gabe baina ez dut ongi gogoratzen. Hori bai lokala! jauregia! baina zikina eta eginbeharreko lana kristona!! Eta hortan hasi ginen, garbiketa egiten. Ura bertan bazegoen baina elektrizitaterik ez eta kaleko farola batetik kablea bota eta udaletxearen << kortesiaz >> argia dohainik genuen. Dena ongi garbitu, pintatu eta astearte gauero, jendeak zabor modura kalera ateratzen zituen muebleak biltzera joaten ginen. Azkenean kolore desberdinetako sofa koadrila haundi bat biltzea lortu genuen eta horiekin batera, mahaiak, ispiluak... dena eta denetarik hartzen genuen eta gero dena egokitu eta erabili. Azkenean Gaztetxea txukuna geratu zitzaigun: goiko partean mahaiak etabarrak bilkurak egiteko eta beheko partean kontzertuak eta taberna irekitzeko partea. Guk ez genion izenik jarri, eta sarreran << Egiako Gaztetxea >> besterik ez genuen idatzi. Hor geundela, udaletxearekin harremanetan jarraitzen genuen, hustutzeko mehatxua etengabekoa baitzen. Hortik bidaliz gero, beste lokal bat emateko eskatzen genion alkateari, ez genuela interes berezirik Jareñon geratzearekin. Behin Gaztetxea txukunduta, astean behin biltzen ginen eta bidea egitera abiatu ginen, << errazena >> lokala lortzea helburu bezala edukitzea baita, baina lokala berez ez da helburua, Gazte Asanbladak finkatu duen lana burutzeko gutxieneko baldintza baizik. Aitortu behar det, hemendik aurrera, eztabaida nahikotxo izan genituela,... bakoitzak proiektu moduko bat baitzeukan Gaztetxearekin eta horiek desberdinak izateagatik guztiz uztargarriak ziren baina gure gaztetasunaren ondorioz seguraski nahikotxo kostatu zitzaigun bidea definitzea eta adostea. Bi talde definitu samar zeuden, alde batetik Jarrain militatzen zutenak eta beste alde batetik << autonomoak, anarkoak >> eta ez bata eta ez bestean sartzen ez zirenak ere bazeuden baina bi talde horien artean zeuden eztabaida gehienak. Orain eta denborarekin ikusita, heldutasun pixka batekin arazorik gabe gainditzeko eztabaidak ziren. Eztabaidak eztabaida aurrera egin genuen, kontzertuak egin genituen, ikastaro batzuk ere bai, argazki ikastaroa, hankapaluen ikastaroa, hortik Gaztetxeko antzerki taldea eratorri zena,...gure liburutegitxoa eta mediateka ere izan genuen. Udaletxeko euskara batzordeari euskarazko liburu eta diskak eskatu genizkion eta ehun bat liburu eta diska batzuk eman zizkigun, denak euskaraz eta liburu eta musika mailegu antzeko bat antolatu genuen. Kontzertu pila egin genituen, lokala apartekoa baitzen baina askotan aipatzen genuen Gaztetxearen dinamika ez zela kontzertuak antolatzearen inguruan mugatu behar baina planteamendu desberdinak egonik ez genuen beti lortzen... Ruper Ordorika etortzea ere lortu genuen...! Txerri bat hazi genuen goiko terrazan, txerriboda egin ere bai, Gaztetxeko txakurra Kraker deitzen zen... eta hainbat gauza...

Pozez natorkizue  
Aupa Gaztetxea!  
Gazteak bildu eta  
Borroka xedea.  
Taldean biltzen da  
Pertsonen legea  
aurrera egiteko  
bai ezinbestea  
gudan bizitzea  
puskatuz katea  
bihotza betea  
hori ondarea  
Zorte on ta aurrera  
Ametsenea!!

**GAZTEOK!**

1982an Satan aldizkaria

Todos los jóvenes el día 12 de Marzo debemos ocupar “La Voz”.“Gestora pro casa de la juventud”

Elkartzeko, axola zaigun zenbait arazo aztertzeko eta beste zenbait gauzatarako tokirik ez izatea da gaur egun Donostiako gasteriak sofritzen dugun problematako bat.

Orduan zen! Prim kaleko 7an hontarako eta gehiengorako zenbait toki lortu dugu. Izenez guztienak baziren ere, fatxak erabiltzen zutenez eta oraindik denak joan ez direnez, ez ditugu eguneko edo gaueko edozein ordutan sartu ahal izateko giltzak lortu. Baina, AURRERA! Gutxi dira dagoeneko eta gehiagotuz goazen neurrian lortuko dugu lokal honen autogeztioa.

GAZTERIAREN ASTEA!

20-21-22 eta 23 egunak Donostiako eta etorri nahi duten gazteei emanak izanen dira. Sonatua izan behar du. Egitaraua martxan dago.

GUZTIOK! Zuek eta gu Prim 7koo lokalen autogestioaren alde.

Donostia

**COMUNICADO A TODOS LOS GRUPOS JUVENILES Y ASOCIACIONES JUVENILES DE DONOSTI (SOBRE LOS LOCALES DE LA DIRECCION GENERAL DE LA JUVENTUD; DE LA C/PRIM)**

1977 Comunicado a todos los grupos juveniles y asociaciones juveniles de Donosti.

El pasado jueves 15, organizaciones y grupos juveniles, celebramos una reunión en el local de la comisión juvenil de Gros, que tenía por objeto el ultimar las informaciones del Ayuntamiento y del Ministerio de Cultura referentes a la situación de los locales de la O.J.E. y de subvención económica, para convocar próximamente a una asamblea de toda la juventud de Donosti, donde se decidirá qué hacer con los locales.

Asistimos: Comisión juvenil de Gros, Euskalerriko Skoutak, I.T., Grupo de teatro de la Facultad de Derecho, Grupo de teatro "Ibeltz", sección juvenil de la A.A./V.V. de Astigarraga, J.J.S.S., E.G.I., E.G.A.M. y J.I.C. Decidimos el concretar la fecha de la asamblea y la posible celebración de una semana de la juventud. Para llevar a cabo estas iniciativas, hacemos una llamada al resto de organizaciones y grupos juveniles (de cualquier clase, deportivo, cultural, recreativo.) para que asistan a una reunión que se celebrará el próximo lunes 19 a las 7:30 de la tarde en los locales de la comisión juvenil de la A.A./V.V. de Gros.

**SATAN (editoriala)**

1982an Satan aldizkaria
Editoriala.

Badugu gurea den aldizkaria. Zeintzuk garen? Donostiako kalesaleak. Gure gorputz eta buruhausteak non aparkatu ez dugunak. Badaukagu, bai, GAZTERIAREN ETXEA aldarrikatzeko erabiliko dugun aldizkaria. Gurea eta guretzat izango den etxe bat, bertan bakean bizitzeko eta sudurraren puntan jartzen zaiguna egiteko erabiliko duguna. Antzerkia egin nahi al duzu?Ba hor duzu etxea. Non bildu ez duen talde bat al zara? Han babestuko zaituzten lau horma izango dituzu; rock taldeek, eskultoreek eta gainerantzeko artista guztiek hantxe edukiko dute beraien txiringitoa. Hitz batean, ideia honen atzetik gabiltzan guztiok izango dugu etxean gure txokoa.

Udaletxeko jaun txisteradun buruuste horiek noren izenean debekatu dizkigute behin eta berriz egin ditugun eskakizunak: proposamendua, hondartzako jaialdia, elkarrizketa, e.a.?

Guztiak ohartu gara horretaz, bai. Zuen gustokoak ez garelako ez dugu ile-apaindegirik bisitatuko ez eta jazki dotorerik jantziko! Gu garena gara eta hala izango beti.

Gazteri-etxearen aldeko gestoraren partaideak 30 gaztetalde izatea aski iruditzen ez bazaizue, hor konpon marianton! Nor mintza daiteke gaur egun gazteriaren errepresentagarritasunari buruz? Zuek ez behintzat.

Baina ez ezazue inoiz kasino barrutik esan, lau urtean behin egiten duzuen moduan, hiriaren arazoek kezkatzen zaituztenik, ez baituzue horretarako eskubiderik; potroetaraino gaituzue, bai zuek eta baita zuen demagogia merkeak ere. Gezur hutsa besterik ez da gazteriaren arazoek ukitzen zaituztenik nahiz eta gure aurrean lerde-jario agertu. Zuek izan zarete gerra honi hasiera eman diozuenak. Guk pilota jaso eta jarraipena ematen ari gatzaizkio.

Tximak luzatu zaizkigu gurea behar lukeena izan aldarrikatuz eta ehoskor mantentzen gara nahiz eta zuek jartzen dizkiguzuen oztopoak txikiak izan ez. Eta zu, orri hau irakurtzen ari zaren hori, zer diozu? Zenbaitentzat gazte izatea eta "porreta" nahiz "tirao" bat izatea berdin da. Halajaina! Halakorik entzun beharra! Ez duzue hitz egiteko inolako eskubiderik, ez baituzue denboraldi luze honetan gazteriaren alde deus ere egin. Gehiegizkoa da zuena!

Beraz, festak eta era guztietako ekintzak antolatuko ditugu, parkeak, hondartza, eta ETXEA aldarrikatuz eta hau guztiaz gain zuen zerrikeriek inoiz lapurtuko ez diguten BIZITZEKO POZA. Horretarako festetan eta hertsialdietan txarangez, antzerki eta rock taldez eta gure ahalmenen neurrian dagoen edozein ekintzaz horniturik joango gara.

Gureak baitira hiria, ETXEA eta alaitasuna. Han izango gaituzue. Eta baita zu ere.

**MESA REDONDA**
**POLITICA MUNICIPAL PARA LA JUVENTUD**

1982an Satan aldizkaria
Gazteoi zuzenduriko Udal politikari buruzko mahaingurua.
Odon Elorzaren hitzak (galderak)

Dentro de los actos previstos durante la Semana de la Juventud, llevada a cabo del 31 al 6 de febrero, se efectuó una mesa redonda que contó con la presencia de los partidos EMK, HB, LKI, PSOE y con una representación de la Gestora pro-Casa de la Juventud. Es de lamentar la ausencia de EE y PNV y LAIA a pesar de haber sido invitados. Fueron muchas las acusaciones vertidas contra el partido mayoritario en el Ayuntamiento donostiarra y que debido a su ausencia no pudieron rebatir.
Tras una presentación inicial que corrió a cargo de los representantes de la Gestora pro-Casa, Mariano Ferrer, que actuó como moderador centró el diálogo en estas 3 preguntas:
1-¿Cómo veis desde su óptica política e ideológica a la juventud actual?
2-¿Cuál es la situación de la misma en los barrios?
3-¿Podéis explicar qué actuación le corresponde al Ayuntamiento donostiarra?

PSOE(Odon elorza)

Voy a centrarme más en el papel del Ayuntamiento como institución de poder local, teóricamente más cercana a los ciudadanos y sometida a un control posible.
Lo primero que no se ha hecho ha sido una encuesta sobre la juventud, sus necesidades y sus aspiraciones. El Ayuntamiento tiene un deber específico sobre una problemática específica como es la juventud, está obligado a dar una serie de medios para que éstos desarrollen sus actividades. Esto no lo está haciendo y hay que reseñar que es un órgano de poder con una mayoría, y una minoría. No se ha planteado la necesidad de dar un cauce a las reivindicaciones, se ha contentado con dar una subvenciones no muy generosas con criterios no determinados.
Hay que presionar al Ayuntamiento sobre una reivindicac-ñon justa ya que de esta forma se va abriendo camino para que la conciencia de la ciudad y de los munícipes en particular llegue al grado de que esa necesidad es justa.
El Ayuntamiento debe dotarse de una infraestructura, un negocio de la juventud y de una comisión de la juventud que formada por un grupo de concejales sirva de interlocutor entre el Ayuntamiento y la juventud, no con un afán de paternalismo o tutela sino con un sentido de responsabilidad ya que al manejarse fondos públicos es necesario la presencia del Ayuntamiento.

**AUZOAK BEHAR DUENA...GUZTIONTZAKO ETXEA, GAZTETXEA!**

2004ean A.Z.G.A.-ren eskuorria.
“Auzoak behar duena...”

Amaitzear dagoen urte honek, Parte Zaharrak auzo bezala dituen beharrak agerian uzteko balio izan du. Droga trafikoak sortutako segurtasun ezaren aurrean auzokideek egindako protestaldiek edo Zuloaga eraikinaren okupazio sinbolikoak kasu, auzoarekiko politika eraginkor baten gabezia argi utzi dute.
Argi dago, auzokideen eskaera eta dinamikarik gabe, Udal agintariek ez dutela gure auzoaren gabeziarik estaliko. Hala gertatu da Trinitate plazarekin (nahiz eta oraindik aski ez den) edo Orixe ikastolarentzat izan behar duen Zuloaga eraikineko lanak hasteko. Lotsagarria iruditzen zaigu hainbeste behar dituen auzo batean urte luzez horrelako eraikin puska hutsik egotea.

Kultur etxerik ez, polikiroldegirik ere ez... Zer eskaintzen digu auzoak gazteoi? Kontsumismoa eta indibidualismoa bultzatzen dituzten tabernak, eta Bretxa bezalako makrokakaplastak.
Gainontzeko auzoetako gazteekin batera, Parte Zaharreko gazteak bilduko garen gunea behar dugu; auzoari gazte eskaintza eta bizia emateko, ideia desberdinetako gazteen elkargune izango den lokal edo etxea. Auzoko jaiak(Karmenak...) antolatzen eta ospatzen jarraitzeko, Triniko beharrei erantzuteko(frontoia estali...), eta abar.Auzoa bizi dadin, auzoan bizi gaitezen, gaztetxea behar dugu. Auzotar guztientzat ateak zabalik izango dituen etxea.

Amesten dugun gaztetxea lortzeko, eta horretarako egon daitezkeen trabak saihesteko, Odon Elorzarekin bilera bat egiteko eskaria erregistratu dugu Udalean. Uneotan, Udalak gure eskaerari emango dion erantzunaren zain gaude. Hala ere, badakigu Udal honek ez digula gazteoi ezer muxu-truk emango. Horregatik, beharrezkoa dugu auzokide guztion inplikazioa eta elkarlana. Parte Zaharreko gazteon nahia eta beharra delako...
GAZTETXEA LORTUKO DUGU!!!

**GAZTETXEAK DEFENDATUKO DITUGU!**

Zuloagako okupazio sinbolikoa.
"Gaztetxeak defendatuko ditugu".

Suntsipena, hautsa, indarkeria, basakeri, eskonbroak, makina txikitzaileak...Euskal-Jai gaztetxea Iruñeako eta Euskal Herri osoko planoetatik desagertarazia izan da. Ehundaka jenderen ametsen errealitate-bihurgailua, topalekua, jai-gunea, askorentzat ere lantegia, eta batez ere, guztiontzat ilusio sortzaile eta eredu izan den Gaztetxea, Yolanda Barcinaren aginduz eta poliziaren indarkeria basatiaz, xehe-xehe egin dute obra-makinaz kamuflaturiko Udal tankeek.

Izugarria izan da Gaztetxearen txikizioaren aurrean jendeak erakutsiriko konpromezua eta gure iritziz, guztiz poztekoak bai Iruñean bertan, eta baita Euskal Herriko beste hainbat txokotan, autogestionaturiko Gaztetxe ezberdinak sortzeko egin diren ekimen eta okupazio ezberdinak.

Gaurko egun honetan, donostiarrok ere txalo bero batekin agurtu nahi ditugu Iruñatarrak, urtez-urte egin duten lan zoragarriagatik, eta nola ez, Zuloaga Eskola hauek okupatzearen arrazoietako bat, Euskal-jai Gaztetxeari gure elkartasuna azaltzea badela esan nahi dugu.

Hementxe bildu gara hainbat gazte donostiar, asteburu guzti honetan zehar, eskola zahar hauek okupatzeko intentzioz, Udaletxearen eta Hezkuntza Delegaritzaren utzikeriaz hutsik dagoen edifizio honetan. Azpimarratu nahi dugu, gure asmoa Igandean burututuko dugun manifestazioarekin batera edifizioa uztearena dela, auzoak behar duen Orixe Ikastola zabaltzeko bertarako dagoen proiektuarekin bat egiten baitugu.
Hona hemen Zuloaka Eskola hauen inguruko eta bertarako proiektuaren hainbat informazio interesgarri:

-98-ko Abenduaren 2-an Udaletxeak eta Hezkuntza Delegaritzak, edifizioa guztiz konpondu eta Orixe Ikastolari emateko protokoloa sinatzen dute.
-2000-ko Mrtxoan Udaletxeak plenoan, 2001-ean hasi eta 2002-an obra hauek bukatzeko, Udaletxea eta Hezkuntza Delegaritzaren arteko kolaborazio konbenioa onartzen da.
-2003-ko Urrian Udaletxeak emana dio jada Hezkuntza departamentuari obrekin hasteko lizentzia, 18 hilabete uzten direlarik hauek bukatzeko.

Bi dira asteburuko okupazio honen bitartez asetu nahi ditugun helburu nagusiak, eta esan beharra dugu egun hauetarako prestatua dugun egitaraua eta okupazioa bera ere, hauen harira planteatua izan dela: batetik eta lehen aipatu bezala, ekimen honen bidez Euskal-jai Gaztetxeari gure elkartasuna adierazten diogu, ekintza honek Gaztetxeari eginiko omenaldia izan nahi duelarik.

Bigarrenik, gure helburua era bada bi egun hauetan zehar Gaztetxeen eta gazte gune ezberdinen defentsa egitea. Ildo honetan, bai Intxaurrondoko Gaztetxeak behar dituen konponketen inguruan, eta baita Loiolako Gazte Lokalaren erresistentziaren inguruan, hainbat planteamendu definitu nahi ditugu. Aurrera begirako Donostiako Gaztetxe baten beharra eta proiektu ezberdinak ere eztabaidatuko ditugu bertan. Gogorarazi nahi dugu Loiolako Gazte Lokala ekainean botatzen saiatu zirela, ez zutela lortu, eta orain, edozein egunetan irits daitekeela honen suntsiketa.

Hauxe litzateke gaur arratsalderako batez ere, eta biharko prestatua degu egitaraua:

-larunbata 11
14:00-tan bazkaria
17:00-tan batzarra
19:00-tan Euskal-jai-en inguruko hitzaldia+bideoa
21:00-etan kalejira Alde Zaharretik
21:30-tan afaria+ bideo emanaldia

-igandea 12
10:00-etan txukundu eta manifestazioa prestatu
12:00-tan estropada emanaldia
14:00-tan herri-bazkaria
17:00-tan manifestazioa Zuloaga Plazatik
Erakusketa bat ere ikusgai izango da egun hauetan zehar. Bestetik, ozen esan nahi dugu Gaztetxe eta gazte gune ezberdinen eraikuntza eta defentsa, egungo sistema kapitalista eta kontsumitzailearen aurrean, eskura daukagun armarik eraginkorrenetarikoa dela. Zein da bestela gazteoi eskaintzen zaigun bizi eredua? Dirua xahutu eta parrandaz parranda mozkor-mozkor aritzea? Telebista eta play station-aren aurrean itsu gelditzea? Horrelakorik ez dugu onartuko eta autogestioaz eta okupazioaz gure etorkizunaren jaun eta jabe izanez, alternatibak eraikiko ditugu. Ez dugu atzera egingo, beti aurrera eta ilusio eta ametsez beterik gainera!!

Bukatzeko, dei egin nahi diogu jende guztiari etxe sorgindu honetara hurbiltzeko, guztiok batera etorkizun berri bat eraikitzen hasteko eta antolatu ditugun ekimen ezberdinetan parte hartzeko. Nola ez, Igandea 12, 17:00-tan Zuloaga plazatik abiatuko den manifestaziora ere deitu nahi dugu eta baita okupatzen, erresistitzen eta alternatibak errealitate bihurtzen jarraitzeko.

GAZTETXEAK AURRERA!
**DESALOJO GEHIAGORIK EZ!**
**GAZTETXEAK DEFENDATUKO DITUGU!!**

## 2004ean Zuloagako desalojoa.

## "Desalojo gehiagorik ez! Gaztetxeak defendatuko ditugu!".

Bart gauean, eta atzo gaur arratsaldeko 17:00-etan ateerako ginela publiko eginda, indarkeria eta ostikada artean kanporatuak izan gara, polizia munizipalen eskutik eta ertzaintzaren laguntzaz. Mila esker haiei gazteon proiektu autogestionatu eta ilusioekin bukatzeko egin duten saiakera ustelagatik, ez bait gaituzte haien biolentziarekin geldiaraziko.

Atzo ere izan ziren mehatxuak eta bai polizia munizipala eta ertzaintzaren presentzia, nabarmenak izan dira une oro gaztetxe inguruetan. Hots, atzo bertan han ginanok kateaz ixten saiatu ziren, bertatik inor atera eta bertara inor sar ez zedin. Noski, ez genien halako astakeriarik egiten utzi.

Baina amets zapuztzaile hauen indarkeriak, bart gauean gertatu den desalojoan jarraipena izan du, eta zer nolako indarkeria gainera!! Polizia munizipala izan da operazioaren buru, ertzaintza ere bertan izan delarik eta gu jipoitzeko, gauak eskaintzen dien inpunitatea ez dute pasatzen utzi.

Goizeko 6:30-ak inguru hasi da dena, momentu haietan 20 bat lagun aurkitzen ginelarik bertan gaua pasatzen eta atzo publiko egin bezala, gaur irteteko asmoekin. Batbatean, zaratak entzun eta konturatu orduko, etxea polizia munizipalak eta ertzaintzak inguratua azaldu zaigu, kaleratzea bazetorrelaren seinale. Guztiok esnatu eta ahalik eta ate gehien ixten saiatu gera, eskura geneukana hauek oztopatzeko erabiliz, eta denok batera gela batetan sartu eta eseri gara, momentu oro indarkeriarik gabeko erresistentzia egin dugularik.

Polizia munizipalaren jarrerak ordea, zur eta lur utzi gaitu guztiok. Zarata eta garrasi gortzaileen artean, ate guztiak txiki-txiki egin dituzte, gu ginen gelara iritsi arte. Inolako hitzik egin gabe, porrak eskutan hartu eta aurpegia estalita zeramaten munizipalek, ez dute inongo konplexurik izan gazteok gogoz jipoitu eta eskaileretatik behera arrastaka ibiltzeko. Penagarria izan da, ateratzen gintuzten bitartean jasan behar izan ditugun mehatxu eta ostikadak, lepoak estutuz eta besoak bihurrituz bultzatzen gintuzten bitartean. Ertzaintza ere kanpoan zegoen eta ez dute inolako zalantzarik egin, hainbat ostikada eta porrazo emateko momentuan.

Gauak eman dien babesarekin eta bertan, ezer gutxi egiteko geneukalarik, Alde Zaharrean elkartu gara okupok. Pasatako beldurra oraindik agerian, zaurituak ugari izan gara, gutako bik, ospitalera igo behar izan dutelarik zauri eta kolpeak sendatzera.

Lehen genioen bezala, izugarria izan da bizi izan duguna. Aurrekariak gutxi dira polizia munizipalaren jarrera errepresibo bortitz hau azalarazten dutenak, baina oraingoan argi erakutsi digute zein den euren talantea. Ernesto Gasko zinegotzi eta poliziaren arduradunak markatzen dien talantea, Odon alkateak ere, polita deritzona dirudienez.

Argi utzi nahi dugu gaztetxeak beharrezkoak ditugula, baldin eta sistema kapitalista kontsumitzaileak ezartzen dizkigun bizi ereduekin apurtu nahi badugu. Bide honetan, asko eta asko gara gaztetxeetan lanean, gaztetxe berriak eraikitzen eta finean, gaztetxeak defendatzeko hautua egina dugun gazteak. Errepresioak ez du inoiz lortuko gure amets, proiektu eta ilusioak zapuztea, edozein koloretako txakurrak badatoz ere. Martxan gara jada, abian gara, eta boteretsuek emango ez dizkigutenez, okupazioa eta irudimenaz aurrera egingo dugu beti.

Bukatzen joateko, bi deialdi luzatu nahi genizkioke mundu guztiari. Lehena, ez inoiz etsitzeko, borroka honetan guk armarik onena baitugu, irudimena. Beraz, aurrera proiektu guztiak! Eta bigarrenik, denok gonbidatu nahi zaituztegu gaur arratsaldeko 17:00-etan gaztetxeen defentsan burutuko dugun manifestaziora.

Besterik gabe, eskerrak ematen dizkiogu atzo okupatu berriko gaztetxera inguratutako guztiei, eta animoak txoko guztietan zehar okupatzen eta okupatzeko intentziotan zabiltzaten guztiei!!! Animo ta eutsi!!

**AMETSAK ERREALITATE BIHURTZEN...**
**GAZTETXEAK DEFENDATUKO DITUGU!**

2005ean Ametsenea “desalojo arriskuan”.

Kaixo bizilagun maiteok,

Pasa den Otsailaren 11ean, auzoko gazteok, urteak hutsik zeramazkien etxea Ametzagaña kalean (lehen Aitor Ikastola) errehabilitatu eta gaztetxe bihurtzea erabaki genuen. Izerdi asko bota dugu orduz geroztik garbitu eta txukuntzen. Ikusi besterik ez dago erakusketako argazkietan azaltzen den zikinkeria.
Malabare tailerra, liburutegia, pin-pona, naturgela, egongela, bideoemanaldiak eta beste hainbat aktibitate jarri ditugu abian Amets-Enea gaztetxean. Hainbat kontzertu ere burutu ditugu, baina horretarako, bereziki insonorizatu eta ordutegia arratsaldera mugatu genuen. Ez baita gure asmoa

OKUPATU DUGU!!!

